

AZALAREN IRUDIAREN EGILEA

**Juan Manuel Piritz Lopez**
1961
Portugalete

1984. urtean kartzelaratu zuten.



C.P. Almeria (Acebuche)
Ctra. Cuevas Ubedas Km. 2,5
Apdo. 221
4.071 Alquián (Almeria)

Lege gordailua
Depósito legal
Dépot légal

**atara**miñe 2006



## Aurkibidea

## Hitzaurrea

Gauza berririk ez nuke esango kartzelan zeozer beti idazten dela esanda; liburu, aldizkari edo beste motako idatziren batzuk – eskutitzak batipat-, beti egin izan direla esatean, ez nuke errebelazio handia egingo.

Edonork gogora ditzake Etxepareren bertsoak, esate baterako, edo karlistadetakoak…Ezagunak dira heriotz zigorrera kondenatutako zenbaiten enkarguz eginda gureganaino iritsi diren bertsoak, "Hamalau heriotzarenak" eta.

Gizakiak berezkoa izango du zerbait esan eta entzunarazi-jakinarazi nahi hori. Askotan pribatua da idazketa –senide eta lagunei bidalitako eskutitz, ipuin, bertso-, baina batzuetan publiko egiten da –bertso paperak, aldizkariak…-. Salaketa baino, karrasi bat aldarrikatzea baino gehiago dago bertso, ipuin, narrazio horietan. Idazten ari dena sormen bila ari da beti, edukian edo forman; beti bilatzen du ederra, bai lehen eta bai orain.

Aspaldikoak diren lanetaraino joan gabe moldatu behar genuke hala ere hitzaurre honetan. Aitzakiren baten premia izaten da norbere jakintzaren mugak disimulatzeko.

Azken 70 urteotakoak dira seguru asko euskal preso politikoek egin dituzten aldizkariak eta idazlan kolektiboak. Literatur lanen monografikoak, hiruhilabetekariak, urtekariak…egin izan dira.

Ezagunagoak dira horietako batzuk, ezezagunagoak beste zenbait. Baina denboran lanbrotu samartuta geratu dira denak edo gehienak, eta lanbrotuko da oraingo Ataramiñe hau ere. Bilaketa eta bilketaren bat egitea merezi du beharbada, historia horri atzera begiratu bat emateko tarteka.

Ataramiñe urtekariak, preso eta iheslarien oraingo koaderno honek, bere aldia bete duela iruditzen zait. Ez da zuzena holako aldizkari baten sorreran iraungipen muga ipintzea, baina betirakoa izango dela pentsatzea oker handiagoa delakoan nago.

Era askotako lanek osatu dituzte urteotako Ataramiñe koadernoak. Bertso, poema, marrazki, ipuin eta narrazio. Burutapen adina lan modu.

Eder bila ibilita ere, ez nuke esango literaturaren lorea aurkitzea izan denik helburua. Bakarkako lanek gehiago dute horretatik lan kolektiboek baino. Eta, hala ere, ahal izan duen dotoreen arituko zen bakoitza, elkarlan honi ekarpenik zintzoena egin asmoz.

Eta elkarlan hori lorpen handi bat da bere xumean. Irakaspen bat ere bai bere horretan, zenbat traba eta zailtasun gainditruz egina den kontuan hartuta batez ere. Horrexegatik besterik ez balitz ere pozik behar genuke aurreneko Ataramiñe hartatik oraingo honetara bitartean geure ahalegintxoarekin lagundu dugun guztiok. Literaturgintzan eta sormenean marka berririk ez dugu ezarri seguru asko, baina geure marka da, apala izan arren. Geuk egina da, ez inork oparitua.

Hil kanpaiak jotzen ari naizela pentsa daiteke, baina berrikuntzarako eskean nabil. Gauza guztiak berritu behar dira denboraren buruan, bidesail bat egin ondoren.

Berritu dezagun hau ere, indar berria hartu dezan.

Hurrengora arte.

*Jokin Urain Larrañaga,*
*La Moraleja (Palencia) espetxetik*

## Sarrera

Irlak... nork ez du inoiz irlei buruzko istoriorik irakurri. Nork ez du inoiz naufrago bakarti galduak irla galduan imajinatu. Eta naufragoen begirada galdua oroimeneko porturantz, etxerantz zuzendua sentitu. Bai... ugariak dira irlei buruzko liburuak.

Behin irakurri nuen deserria irla bat dela. Edo deserri izena –eta izana, jakina- daraman irlarik ez zaigula sekula faltako... deserriko istorioak, ala Historiak hobeto esanda.

Irakurrita dekot bat non Ovidio poeta erromatarra, Augusto enperadoreak aginduta, atzerriratua izan baitzen. Elba uhartera bialdu zuen, kasik hogei mende beranduago Napoleonen estrainamendua ere ezagutuko zuen irla berbera, hain zuzen. Behin, baten batek atzerria definitzeko Ovidiori eskatu ostean, azken honek hondartzako harean irla bat marraztu baino ez zion egin...

Bai, deserria irla bat da. Eta neure berbak, lau hormon arteko berbak, geure berbok, handiagoak, sakonagoak diren hormen artean dagoen herriarenak, berba horiek guztiak –Ovidiorenak bezalaxe- galdutako irlak dira lengoaia ofizialeko hiztegietan. Berba horiek guztioriek naufragoen irlak dira Ozeano Pazifikoan... atzerri, otserri, lagun min, herrimin, mina, Tristeak izena eman zion Ovidiok deserrian idatzitako elegiari.

Gure berbak ez den herriaren, deportazioaren ikono dira. Hortaz, inork ezin izango du aurkitu berba erosorik, berba deskantsaturik geugan. Inori deserriratuen aurpegietan zorionaren arrastorik kausitzea ezinezkoa suertatuko zaion bezalaxe.

Bai, beste behin irakurri nuen lez, cárcere é descansar ao lado dum rélogio de parede, um rélogio de quatro paredes. *Cárcere é como esvaziar todas as coisas. É como todas as caixas vazias... e exilio é refugiarse-se no futuro e nos demais tem-*

*pos verbais. Exilio é uma palavra que soa absurda, como se tivesse sido repetida de máis. Cárcere, ou exilio, é o papel, como este, em que a gente escreve. Exilio, ou cárcere, é bater do outro lado de uma porta pechada...* . Bai, sarritan Sarriri irakurrita dizkiodan berba horiek deserriratzearen auhenak dira. Ainuriak isiltasunaren erdian... deserria, atzerria, giltzapea, zauri zornatuak dira. Gainean esparatrapu bat eraman beharrean sagu-zahar bat daramaten zauriak.

Nonbait nuen irakurri, XVIII. mendearen amaieran, baita XIX.ean ere, Inperio Britainiarrak matxinatu irlandarrak deportatzeari ekin ziola. Nora eta Australiara, munduko irlarik handienera... Bai, deserria irla bat da... eta deportaziorantz zeramatzaten belauntzietako sabeletan, izerdiak, goseak eta olatuen zorabioak sorrarazitako botaguraren artean, irlandarren auhena, deserriratuen ainuria zen entzungai: *Oh, oh, oh, I wish I were back home in Derry*. Derryra, etxera gura izango ninduke itzuli atzera.

Eta berrehun urte beranduago –irlandarrak, mendez mendeko erreboltarien askazi menderaezin hori- Long Kesh espetxean preso errepublikazaleak idatzita zuten, han, hil ala biziko espazio zarratuan, ziega bat edo besteko paretaren gainean, harramazkatuta: *Freedom is a state of mind.* Liberdadea egoera mentala da*. Oh, oh, oh, I wish I were back home in Derry*.

Deserria irla bat da. Eta hemen, irla honetan gauek eta egunek lau horma dituzte. Ataramiñe liburuan ere lau horma, lau izkina eta lau berba aurkituko dituzu. Orrialde hauetan aurkituko duzuna *é como descansar ao lado dum rélogio de quatro paredes*. Gauak, egunak, asteak, urteak, sasoiak atzamarren artean zaizkigu joanak. Denbora. Lau hesiz inguratutako irlan ihesean dihoazkigu instanteak, minutuak, astiak. Batzuetan astiro astiro paseeran gabiltzalarik, munduko denbora osoa soberan izango bagenu lez. Besteotan, ordea, arineketan egiten dugularik, denbora –arnasa bailitzan- faltan izango bagenu lez... ihesean dihoazkigu segundoak, minutuak, joanak eta gerokoak.

Lau horma, lau izkina, lau berba eta txironeko izara zuriz egindako fardeltxo batean kabitu ezin daitezkeen hainbat sentsazio, hainbat eta hainbat oroimen. *Teixeiro prisión, donde telarañas y presos ocupan su rincón*. Subsistentzia, sube-

xistentzia, inexistentzia edota lau hormetan beste adreiluren baino ez izatearen aurkako erresistentzia.

Oividiok ezin izan zuen egundo Erromara itzuli. Heriok besarkatu zuen Konstantzan, Erromatik ehunka eta ehunka legotara.

Arrazoi zuen bai, deserria irla bat da. Irla handia, Australia kasu, ala txikerra, Elba, Cabo Verde, Sâo Tomé legetxe. Deserria herritik ospa dauden irla ezezagun eta iluna da. Territorio ospel eta ahaztua. Deserria lau hormen arteko irlak dira. Izen exotikoak dituzten irlak: Botafuego, Monte Rosso, Font Calent, Fleury Merogis, Lannemezan... bukaezina ematen du deserriko artxipelagoa zerrendatzeak.

Lau horma, lau izkina, lau berba. Gauak, egunak, asteak, urteak, sasoiak hondartzako harea fina bezala, Ovidiok irla marraztu zuen harea fin hura bezala zaizkigu joanak atzamarren artean.

Lau horma, lau izkina, lau berba. Haize zakarrak liburu zabaldu bati –Ovidioren Tristeak elegiari- orriak pasarazten dizkion lez zaizkigu joanak gauak, egunak, asteak, urteak eta sasoiak.

Hori dela eta, preso, iheslari izandako edonoren oroimena beti bueltatzen da gartzelara, deserrira. Preso, iheslari izandako orok bere existentziaren zati nagusia gartzelan, deserrian uzten baitu.

Beraz, preso, iheslari izandako orok etxeko kai metropolitanoan naufrago ematen du. Bere begirada galdua joaneko irla galduetarantz zuzentzen duela...

Bai, deserria irla bat da... & *freedom is a state of mind*. Liberdadea egoera mentala da. Liberdadea, irlan egon arren, norberak barrenetan daraman lau hormarik gabeko Estatuaren izena da.

Hemen, Ataramiñen, idatzi ahal izana as-ka-ta-su-na oihukatzeko parada izan da.

Ataramiñe irakurri eta irakurriko duzuen orok geure irlak ezagutzeko parada izango duzue.

Ataramiñen idatzi dugun orok, han idatzitako letren bitartez, irlatik nolabait hanka egin ahal izateko parada izan dugu.

Plazera, ohorea izan da letra xume honetan parte hartu ahal izatea.

Plazera, ohorea begirada galdua irla galduetarantz berriz zuzentzea...

*Aitor Lorente, preso ohia*



**Garikoitz Arruarte Santacruz**
1980
Hernani

2003. urtean hartu zuten preso.



C.P. Madrid II (Meco)
Ctra Alcala-Meco, Km.5
28.880 Alcalá de Henares
Madrid

## 1. Amona

Negar egin ez dezazun kantatzen dizut, amona,
malkoek arroilik sor ez dezaten
irribarreak betertzean marrazten dizkizun zimurretan,
            ilusio eta oinaze urteek zizelkatuak,
zure begirada eztian leundu nahi dudalako
barruan dudan samina.

Atzerriko hizkuntzan agurtu genuen elkar
baina azken muxuan ezin izan zuten
            bihotzetik eztanda batean ihes egin zuten bi hitz haiekin,
            taupada herren harekin.
eurek ere entzun zuten maite zaitut hura
aurrez aurre egongo ginen
            azken aldia izango zenaren beldurrak ahoskatua.
Ez zinen ohartu, ez zenuen ulertzen
baina begirada basati haiek,
            gorrotoa begietan zamatua,
lurrean iltzatu zituzten
inoiz ezagutu ez duten duintasunaren bila
            zure etxeko sukaldean.

Egunak badoaz denboraren harian aurrera
            arin zuenean, astiroago hemen
baina garden entzuten dira oraindik intziriak,
atarian lehertu zen bilobaren garrasi irentsiak.
Lehertu egin nintzelako, amona,
Instant batez amildu nintzelako
zure begi hezeen oroitzapenean.

Hogeita hiru urte amona;
Zenbat une aproposago?
Zenbat ordu elkarrekin?
Eta azken muxuan lehenengo maite zaitut
lehenengoa, amona!
Eta azken muxua
badakidalako,
esan didatelako oso eri zaudela.
Garden entzuten dira oraindik
atarian ito ziren intziriak.

Negar egin ez dezazun kantatzen dizut, amona,
berandu dela dakidan arren
maite zaitudala esateko,
urrundik baina ozen,
nire ahotsaren oihartzunak laztan zaitzan
sukaldeko lehio ondoan.
Kalera begira nire zain jarrai ez dezazun eskatzeko
kantatzen dizut, amona,
zure begi eztien oroitzapenean leundu nahi dudalako
azken muxuaren samina.

*2005.06.18.*

**2.**

Erotismoaz ari ginen solasean,
patioan,
gordeak ditugun amets jostalarietaz
eta zurekin akordatu naiz.
Oroitu ditut mahai gainean utzi zenuen pistola,
beltza,
hotza,
hain geldiro erantzi zenuen kamixeta estua,
sutondo goxo hartan desiratu nituen bular biluziak
ilunabarreko gerizetan hain ederrak,
lozakuaren barruan borboka sentitu nuena
ukabila airean baina irmoago,
zure irribarre bihurria
eta ongi lo egin madarikatu hura
masaileko leun bat bezala.
Niri ohostu didazu gaur irriño bat
zuk jakin gabe.
Zauden tokian zaudela
muxu bat.

Egia eskatu didazu erruki zaporedun sotiltasunez
eta nik gezurra hartu dut mailegutan,
mila bider behin, mila bider berriro,
badakidalako dakizula nik jakitea nahi ez dudan hori.
Ez dizut esango hormak biluztu ditudala,
koloretako irribarreak izkutatu ditudala,
kutxatzar batean abandonatuak direla,
uneoro oldartzen zaidala iragana
eta oroitzapenak ere bahitu ditudala.
Ez dizut esango madarikatu ditudala zoriontsu ginela uste izandako egunak,
amaiera gertu ikus dakiokeen plazerraren zirrara bezela.
leihoak hersten ditudala
hegoaizearen ufadek sala ez nazaten,
entzun ez nazazun.
Ez dizut esango gezurrezko gotorlekuak eraiki ditudala osin gazietan
eta koloretako hegazkinak umeltzen direla haztatutakoan.
Ez dizut esango zure ahotsaren igurtziak kilima egin didala lepoan
eta gaur ere zuganainoko bidaia klandestinoa egingo dudala
mihiseen fereka artean.
Ez dizut esango antzezle sinesgarri bihurtu naizela,
antzerki eskolak hartu ditudala
ispiluaren aitzinean paraturiko ordu luzeetan
hegoaizearen ufadek esan ez diezazuten
zure eztizko begiek fusilatzen nauten berrogei minutuetan
malkoak zentsuratzen ditudala
keramikazko bisaietan.

*2004.09.19.*

**3.**

Esku bik elkar hartu dute
elkar laztandu dute
kristalaren alde bietan.
Begi gazien dardara,
irribarre gozoaren zirrara,
sahietsartean eztanda
eta eskuen laztana
kristalaren alde bietan.

*2004.04.15.*

**4.**

Garagardoaren antzekoa da iragana
gogoan ditugun oroitzapenik ederrenetan
ito nahi izaten ditugulako
orainaren tristurak
oinazeak
beldurrak
jakin gabe azalean geratzen direla
kondenatuak gaudela haiekin bizitzera
inoiz etorkizunak ezabatuko baditu.
Gaur iraganarekin egin dut tratua
oroitzapenetan nabigatzen hasterako
eraiki dezan ahanzturaren hormatzarra
etorkizunerako ametsak eraikiko baditut.

*2004.07.24.*

## 5.

Utzidazu sinesten betirako dela,
rekuentoaren burni dantzak
bananduko ez gaituela.
Utzidazu sinesten
ez ditudala alferrik galdu malkoak
eta borroka ederra dela,
elkarrekin ospatuko dugula,
muxuak alokatzen direla
hilean behin bederen,
hala den, ba ote den.

Esaidazu ukabilak airean direla,
ikusi uste zenuena naizen,
aldatu ote naizen,
esnatu ote naizen,
ala ametsa den,
sakabanatu ote garen.

Esaidazu ez dela azkena,
azken muxuaren eztena,
amildu ote den garai batean zena,
maite al nauzu, laztana!

*2004.06.25.*

## 6.

Ilusioa papelinetan saltzen ari direla
erran didate, adiskide!
Harriak ez direla txakurrentzako,
garestiak direlako.
Gure aitaren etxeak zutik diraulea… enkantean;
eta duintasunak ihes egin duela bart arratsean.
Iraultzaile erradikalek Che-ren pegatak
jartzen omen dituzte Audi-aren atzealdean
"Harrapazak, Ernesto!"
Eta gure argazkiak zigarreten ketan lusotzen direla
zurito zaporeko garai zaharren omenetan, adiskide!

Guk mundua aldatzea lortzen ez badugu ere
munduak gu alda ez gaitzan borrokan
ikusiko dugu elkar
arrazoiak zentzua hartzen duen lubakietan
non hitzak izanen diren bala.

*2004.06.25.*



**Aritz Saez Insausti**
1980
Donostia

2002. urtean atxilotu eta espetxeratu zuten.



C. P.  El Acebuche
Apdo. 221
04.130 El Alquian (Alemeria)

## 1.

*"…Mucho más*
*allá de mi ventana..."*

*– Silvio Rodriguez –*

Barrote, porlan, harresi ta kasernez
haratago,
itsasoa besterik ez da.
Irudipenen joan-etorrian;
Aiako Harriak, Haize Orrazia, momentuko neskatxa, lagunen gaupasa edota
hire txapela laztantzea;
Eguneroko joan-etorria.
Ametsa besterik ez da,
Haratago,
barrote, porlan, harresi ta kasernak.

…herriak Berak hautatua hainbatetan
Euskal Herri osoak agurtuta.
Ilunpeko Iñurrategi,
Gure Txokoako Orbaiz,
Lancreren etsai,
Zugarramurdi inguruko amorante
ta euskararen maitale…

300 gautik gora
soka etenez,
moztuz,
deskorapilatzen,
lasatuz
…
ta eten ez.
Barrotedun ohera
alferrik itzuliz
300 gautik gora.

…hormen arteko, bertso-paperen Txirrita,
eskuz banakako Retegi,
sagardo klandestinoaren jabe,
Gebreren pare korrika,
umorearen Bilintx,
ta txorkatilaren ministro…

300 gautik gora
soka etenez,
moztuz
deskorapilatzen,
lasatuz,
…
ta eten ez.
Ametsen ezbaian
begietara so
300 gautik gora.

Altamiratik Loarrera, Gaskuñatik Atapuerkaraino,
haratago,
itsasoa besterik ez da.
Irudipenen joan-etorrian;
bakardadea, isolamendua, bortxa, begi kliskada mirilan ta
idatzizko milaka muxu;
eguneroko joan-etorria.
Ametsa besterik ez da,
haratago,
zu, Askatasuna.

*Hiri, Kotto!*
*Almerian, 2006an*



**Harriet Agirre Gartzia**
1979
Donostia

2005. urtean hartu zuten preso.



M.A. des Hauts de Seine
133, Av. de la Commune de Paris
B.P. 1414
92014 Nanterre Cédex

## 1. Oroitzapenak

Oroitzapenak egunero ederrak dira,
itsasoaren usaia,
sudur zuloetatik sartu
eta begi barrenean
itsasoratzen da
ene masailetik
bidai egiteko gogoarekin.
Oroitzapenak egunero ederrak dira,
mendi ttonttorreko elur usaia
sudur zuloetatik sartu
eta izotzaren nortasuna
odoletik nabaritzen dut
beroa hoztu nahian,
horrela oxigenatzen dut
ene burua.
Oroitzapenak egunero ederrak dira
gau giroaren usaia
sudur zuloetatik sartu
eta nire bihotza
oroitzapenetan mozkortzen da.
Oroitzapenak egunero ederrak dira,
herria mila kolorez hornitu da,
bakoitzaren usaia
nire sudur zuloetatik sartu
eta bizirik mantentzen nau
etsaiaren kiratsaren artetik,
oroitzapenak egunero ederrak dira.

## 2. Filma

Argia agurtuz
egunaren iluntasunean
etzan da ene gorputza,
argizariari putz eginaz
gauaren isiltasunean
ezkutatu dira begiak.
Lorearen filmean
murgildu da imajinazioa,
filma guztietan bezalaxe
fikzioak bete du
errealitatezko
ametsaren hutsunea.

## 3. Itxi ta ireki

Ateak itxi zirenetik
bihotzak ireki egin ziren,
gaur ordea ireki egin dira
bihotzak berriz itxi egin dira,
begiak ere itxi ziren
baina begiradak gurutzatu genituen,
begiak irekitzean berriz
begiradak lotsaturik gorde dira.
Gorputza dardarka
ene ohe itxira noa,
itsutasunean bakarti
ametsak irekitzera…

Hotza omen da
berotasun honen lotsa.

## 4. Izotzaren begirada hotzetan

Izotzaren
begirada hotzetan:
malko bero bat
sortzeko asmoarekin
begirada itsu bat
eskaintzen dizut
urruntasunaren leiho hotzetik,
eguzkia piztu dut
oroitzapenaren tximiniari,
txinparten artean
sumatu zaitut
distantziaren hoztasunean
iragana berotu ezinik.
Lasaitasun taupadez
noakizu
negu hotzean
bihotz beroek
borrokan dirauten bezala,
egun beroez
gozatzeko ziurtasunarekin…
Egurrez elikatuko dugu,
suaren askatasun gosea,
izotz guzien gainetik
su txikiak piztuz
irabaziko dugulako.

## 5. Galdezka

Desioak garesti.
Ametsak ere bai?
Ametsa desio dut
desiozko ametsetan…
Halere errealitateari
bizkarrik eman gabe
aurrera egingo dugu,
errealitatea ere
amesten dugulako
etorkizuna egingo dugu
orain idatzitakoa
iragana bada ere.
Borroka garesti.
Askatasuna ere bai?
Askatasuna borroka da
borrokaturiko askatasunaren…
Halere errealitateari
bizkarrik eman gabe
aurrera egingo dugu
borrokaz erosten den desioa
askatasunez amesten dugulako.

## 6. Gure Herria

Gure Herria
orri txuri hau da,
boligrafoaren tinta berriz
borrokatu beharreko
geroa.
Gure Herria
lur zati ttipi hau da,
hazia berriz
etorkizuneko ametsa.
Gure Herria
egur zati hau da,
sua berriz
arbasoetatik jasotako
erresistentzia.
Gure Herria
negar ttantta hau da,
erreka berriz
jarraitu beharreko
bidea.
Gure Herria
haur txiki hau da,
amaren bularra berriz
izango garenaren
sostengua.
Gure Herria
aberri aske hau da,
hizkuntza berriz
batzen gaituen
Nafar katea.

## 7. Pausoak

Pauso bat, pauso bi…
altxa erori altxa
bizitza honetan milaka pauso eman arren
denak berdin neurtzen ez dutela badakit,
badaude pauso handiak, txikiak…
baina inportanteenak,
norabidea aldatzen dutenak direla
konturatu nintzen horretan
bideari ekin eta abiadura bizian
noa eri hotzeraino,
bide honetan pauso grisak aurkitu ditut
laztan zein muxuak ere nirekin datoz askotan,
mendia, ura, asfaltoa…
noizbait harresi tartean emango ditut pausoak,
hauek ere norabide bat dutela badakit
askatasunerantz eman beharrekoak alegia,
agian bidean eroriko naiz,
baina nire zapatak beste batek jantziko dituen
esperantzarekin
beldurrik gabe noa aurrera.
Pauso xume hauek
herriaren taupadak direla dakigunok
ez dugu ibiltzeari uko egingo
sasi espetxe nahiz izarretan bagaude ere.

## 8. Aske

Preso bizi den herrian
aske naiz borrokan
aske naiz urruntasunean
aske naiz gertutasunean
inoiz ez bezala libre.
Borrokan aske
maite izan dugunok
begiak itxita ikusten dugu
etorkizuna,
ez jakintasunean
momentua desaprobetxatu ezinik
muxu zein laztanak gordez
begiak ireki eta
izan zena ahantzi gabe
borroka bi eskuekin eutsi
eta mendian gora goaz
ttonttorreraino…

Paper zati bati loturik
metal bati loturik
kontsumoari loturik
aske bizi al dira?
Aske maite ahal dute libre?



**Aitor Elortza Unanue**
1960
Paris

Aitorrek 1980. urtean Algortatik ihes egin behar izan zuelarik, atxiloketak, errepresioa eta jasarpena bere gorrian ezagutu zituen bere erbesteraldian.
Jasarpen horren ondorioz gaixoturik,
2006ko urtarrilaren 16an hil zen Baionan.



**Naiara Mallabia Sanchez**
1982
Bilbo

2003ko udaberrian atxilotu zuten.



C.P. Villabona
Finca Tabladiello (AS17-Avilés)
33.480 Villabona Llanera
Asturies

## 1. Escribir

Escribir como camino de ir y de regresar,
escribir echándote de menos, escuchando una canción más,
escribir curando heridas y en silencio gritar,
escribir en vuestro cielo y volver a casa una vez más.

Escribir para volar libre y entre líneas escapar,
escribir sin compañía, a solas con la soledad.
Escribir lágrimas que arden y no se pueden apagar,
escribir sobre puertas cerradas que nunca quise cerrar.

Escribir cuando todo me falta, en un solo despertar.
Escribir para poder encontrarte, cuando no estás.
Escribir tras la barricada, sin dejarte atrás.
Escribir cuando se hace tarde pare el mundo y para los demás.

Escribir sin miedo a quererte, aunque sea caro soñar.
Escribir con un nuevo comienzo y un diferente final.
Escribir con palabras huidas y con las que no pudieron escapar.
Escribir con tinta de mi aliento en tu corazón de cristal.

Amar sin pensar, sentir sin censurar.
Soñar en guerra, escribir y pelear.

*Villabonako espetxean, 2006ko iraila*

## 2. Soñemos

Soñemos con una noche
o con un despertar,
soñemos con beber
de un vaso de cristal
Soñemos con un cuerpo
que no puedan cachear
Soñemos con un abrazo
que no pudimos dar
Soñemos con que el tiempo
no nos deje atrás
Soñemos con un amor
que la cárcel no pueda matar.
Ni nadie
nos impida soñar.
Soñemos en la sombra
Soñemos en la oscuridad
Soñemos entre rejas
entre tanta realidad.

*Brieva-ko espetxean, 2006*

**3.**

Libre amaneció el día,
presa se acostó la noche.
Huyeron las estrellas,
cachearon ilusiones.
Agotaron la inocencia.
Mataron al tiempo,
golpearon nuestro cuerpo,
pero no cayeron sueños.
Sangraron las heridas,
lloró la noche.
Vivió la rebeldía.

*Brieva-ko espetxean, 2005 abendua*

## 4.

Te marchaste mirando atrás
Acabó la noche contigo
sin un solo despertar,
¿dónde está esa sonrisa
que no consigo encontrar?
Todo cambia
sin poder reaccionar,
tu te marchas
y yo sigo mirando atrás
recordando aquel beso
que el mundo consiguió parar.
Esto no es un reencuentro
para quien no se quiere encontrar,
estas palabras están rotas
y no se pueden pronunciar.
Mis lágrimas gritan
encerradas por la realidad.
Acabó la noche contigo
sin un solo despertar.
Busco estrellas en la noche
que no consigo encontrar.

*Villabonako espetxean, 2006 iraila*

## 5. Ezin izan zuten

Ezin izan zuten ilargia amatatu.
Ezinezkoa zuten izarrak bahitzea.
Malkoa ez zen bakarrik geratu,
alboan zuen irriparra.

Ezin zituzten ametsak harrapatu
elur txirristetatik ihesean
ta gauza txikien munduan
gurea zen detaile handiena.

Bihotzak libre mantendu ziren
etsaien eskuetan
eta ginenak, orain ere bagara
biziak baino biziagoak.

Faltan izaten zaituztet
egutegiko egun guztietan
eta agertzen ez diren gaubetan.
Irritsu, pentsatzen dut ixilpean,
zenbat irabazi ahal den
galtzeko eraiki zuten lekuan.

*Oihane, Regina ta Ikerneri.*
*Nire ziegan zuen argia*
*beti egongo da piztuta.*

## 6. Gauak

Kolorerik gabeko gauak
kolpez ixildutakoak,
gau politak eta
gau itsusiak

Gau amaiezinak eta
bukaera dutenak,
gau ixilduak eta
oihuka esnatzen direnak

Gau gordinak eta
ametsez egindakoak,
gau biziak eta
lo egiten dutenak

Gau goxoak eta
hormetatik igotzen direnak,
gau sekretuak eta
kontatzen direnak

Gau ezagunak eta
ezagutu beharrekoak,
gau argiak eta
izarrik gabekoak

Gau libreak eta
gau espetxeratuak,
zuen konpainiarekin, eta
nire bakardadean.

*Villabonako espetxean*



**Asier Kintana Zorrozua**
1968
Bilbo

Aurten espetxeratu dute.



Angoulême. Maison d'arrêt
112, rue St Roch
BP 1.358
16.016 Angoulême Cédex

## 1.

Euskal Herriko zeruetan
milaka sorgin askeak
bideak irekitzen dabiltza.
Euskal Herriko bideetan
milaka sorgin askeak
pozez eta adorez borrokatzen dute.
Euskal Herriko sorgin aske asko
estatuen barroteen artean
kolorez betetzen dute oraina
eta geroa.
Zuek sorgin gudariak.

## 2.

Euria entzuten dut
bere soinuaren indarra leihotik sartzen da
Ezin dut ikusi
baina bere lurraren kontrako txokeak betetzen nau
Hotza egiten du eta ohean nago mantekin estalia
Goizean patiora atera naizenean
tantak aurpegian sentitu ditut
Nire ahotik lurrinak ihes egiten zuen
Patioan zerura begira estalia zegoela ikusi dut
eta orain gauean hemen itxita
euria entzuten dut.

### 3.

Ez da erreza izanen salto egitea
putzu ilun eta sakon horren gainetik
Ez da erreza izanen ikustea
begiak ireki eta barroteak daudenean
Ez da erreza izanen eskutik hartzea
distantzia hormaturik dagoenean
Ez da erreza izanen laztantzea
eskuburdinak jarrita dituzunean
Ez da erreza izanen maitatzea
gorroto eta ezintasunaren erreinuan
Ez da erreza izanen barre egitea
tetriko eta tragiko diren lekuetan
Ez da erreza izanen negar egitea
minetik at gutxi dagoenean
Ez da erreza izanen pentsatzea
nagitasuna eta ezagupen eza nagusi direnean
Ez da erreza izanen borrokatzea
askatasuna legez debekatua denean
Ez da erreza izanen…ez.
Eta hala ta guztiz ere lortzen dugu.

## 4.

Hitzik ez dutenek
beraien hitza uneoro jaten dute
esandakoa betetzeko asmorik gabe
lasaitzeko baietz esaten dizute
eta atea ixterakoan
patapuf! Haizea pasatu da
eta esandakoa ahaztu dute
Bazoaz zure baimenarekin
legea izango balitz bezala
haizeak eraman du
Eta oraindik ez dakizu
Erregelamendua dator
Zure alde denean
badago beti segurtasun
arrazoiren bat
kontra egiteko eta debekatzeko
Zure kontra denean
gillotina bezala
erortzen da zure lepora
Hau da besteren artean
espetxe sistemaren erokeria
Legerik eza
Errespeturik eza
Humanitaterik eza.

## 5.

Haizeak ilargia liluratzen duenean
izarrak erortzen dira,
haizeak ilargia liluratzen duenean
arrosa usainak dena betetzen du,
haizeak ilargia liluratzen duenean
musikarik delikatuena entzun daiteke
dantzarako gonbite irekia
eskutik hartzeko begiak itxita,
haizeak ilargia liluratzen duenean
nire desio sekretuak gorpuzten dira
zu besoetan zaitudala
aurpegia aurpegiaren kontra
berba goxoak belarrira xuxurlatuta,
haizeak ilargia liluratzen duenean
espetxeko barroteak apurtzen dira
hormak behera erortzen dira
eta gu besarkatuta
atzera begiratu barik bagoaz.





**Kepa Etxeberria Sagarzazu**
1975
Donostia

1999. urtean atxilotu eta espetxeratu zuten.



C. P. A Lama
Monte Racelo, s/n
36.830. A Lama
Pontevedra



## Eguzkilorea

Orain dela milaka eta milaka urte, gizakiak munduan zabaltzen hasi zirenean, ez zen ez eguzkirik ezta ilargirik ere.

Gizakiak ilunpetan bizi ziren, suzko zezen, zaldi hegalari edo herensuge erraldoien itxura hartuta lurraren erraietatik ateratzen ziren mamuek izuturik.

Gizakiek, bada, lurrari laguntza eskatzea erabaki zuten etsimen hartan.

- Amalur, lur ama, arren eskatzen dizugu babes gaitzazu hondatu behar gaituzten arriskuetatik.

Lurra lanpeturik zebilen erabat eta ez zien jaramonik egin, haiek, ordea, ez zuten atertzen, eskatu eta eskatu eta azkenean gogoan hartu zuen eskatzen ziotena.

- Laguntzeko eskatu didazue, seme-alaba nireak – esan zien- eta lagunduko dizuet. Izaki argitsu bat sortuko dut, eta ilargia deituko diozue.

Eta lurrak ilargia sortu zuen.

Hasieran izu-izuturik zeuden horrekin gizakiak, beren haitzuloetan gordeta, handik irteten ausartzen ez zirela, baina berehala ohitu ziren haren argitan ibiltzen.

Gizakiak bezala jeinu eta herensugeak ere oso izutu ziren zeruan argizko gauza hura ikusten hasi zirenean, baina denborarekin….

Berriro joan zitzaizkion gizakiak lurrari erreguka.

-Amalur, esker guztiak ematen dizkizugu ilargia amandrea sortu izanagatik, baina zerbait indartsuagoren beharra dugu, lurpeko jeinuak erasoka ari baitzaizkigu oraindik.

- Ongi da – erantzun zien lurrak- ilargiak baino argi gehiago duen izaki bat sortuko dut, eguzki deituko diozuena.

Eta lurrak eguzkia sortu zuen. Hain zen handia, hain argia eta hain beroa eguzkia, non oso geldiro ohitu behar izan baitzuten gizakiek haren argitara, baina pozgarria izan zen hura, zeren haren beroari esker, landare eta zuhaitz biziak hazten hasi ziren eta.

Mamu eta herensugeak ezin izan zuten ordea egunaren argitasunera ohitu, eta harrezkero gauez soilik ateratzen ziren gizakiei erasotzeko.

Berriro joan ziren gizakiak lurrarengana.

- Amalur, pozik gaude eta esker onez ama ilargia eta ama eguzkia eman diguzulako, baina beste zerbait behar dugu oraindik, zeren, nahiz eta egunez den bitartean arazorik izan ez, gauez mamuek beren leizeetatik ateratzen dira eta…

Lurrak abegi onez entzun zituen honetan ere gizakien eskariak.

- Ongi da, berriro lagunduko dizuet. Lore bat sortuko dizuet, guztiz ederra, hain ederra ere, non gaueko mamuek ikusten dutenean, eguzkia bera dela uste izango baitute, eta bakean utziko zaituzte.

Eta lurrak eguzkiaren lorea sortu zuen. Eguzkiloreak, gaur egunean oraindik gure etxeak, mamu gaiztoetatik, sorgin, gaixotasun ekarleetatik, ekaitzetatik eta tximistetatik babesten gaituena.



**Iñaki de Juana Chaos**
1955
Donostia

1987. urtetik dago espetxean.



C. P.  Madrid VI (Aranjuez)
Carretera N-400, Km. 28
28300 Aranjuez
Madrid

## Homenaje a un fuguista

Y el viaje por mar duró setenta y dos horas, contadas segundo a segundo. Un calabozo en la bodega del barco. Una letrina. Una litera. El rítmico traqueteo del sonido metálico de las máquinas clavándose en los zumbantes oídos. Una luz brillante en el techo que traspasaba la fina piel de los inútiles párpados cerrados. El hedor a desperdicios, a excrementos atascados a lo largo de mil travesías. Palabras provocadoras. Permanente vigilancia, por la amplia mirilla de la puerta reforzada, de verdes uniformes mercenarios de miradas chulescas.

Tres días de singladura que me sirvieron para reflexionar sobre el pasado.¡Que persona más diferente era yo de la de dos años antes! Veinticuatro meses separaban la ida y el regreso de la cárcel canaria. Setecientos treinta largos días que habían sido suficientes para que el viaje lo realizaran personas distintas. Lo logré yo, y lo consiguieron los compañeros presos políticos y mi compañera Amaia. Por mí sólo, sin su ayuda, no habría podido cambiar, y el retorno a la Península lo habría realizado dentro de una caja de pino.

Llegué a aquel penal desesperado, toxicómano, humillado, derrotado, arrastrándome y tembloroso, con la única ilusión de obtener la "papelina" diaria y esperar pasivo el final de la vida. Volví recuperado, desintoxicado, con fuerza y dignidad descubiertas, con ganas de vivir, de luchar, de salir de prisión para recuperar a mis hijas…Desde aquel momento en adelante, una obsesión embargó mi mente: escapar de la cárcel para vivir junto a Amaia, Ana y María.

Al atracar la nave en el puerto de Cádiz, me trasladaron a un furgón de la Guardia Civil, al interior de un habitáculo de chapa de un metro cuadrado compartido con otra persona. Mi compañero de cajón era igual al que yo había sido: daba lástima. Setecientos kilómetros de carretera y dos días después, llegamos a la prisión de Alcalá-Meco. Un traslado rápido y entretenido dedicado a maquinar los detalles de la evasión.

La suerte volvió a darme la espalda y, en el departamento de ingresos, me destinaron al módulo tres. En cuanto crucé la segunda puerta mecánica lo vi: allí estaba el Tenazas. Algo más envejecido, calvo, delgado – la vida tampoco lo había tratado bien -, pero era él: los dedos no le habían crecido. En el extremo opuesto del patio, con un café entre sus pinzas de la mano derecha y un cigarro atrapado entre sus gemelas de la izquierda, sin percatarse de mi presencia, estaba la causa de mi detención, del sufrimiento en prisión, aunque también el que, con su delación, había hecho posible que encontrara, finalmente, un nuevo camino fuera de la heroína.

¿Coincidencia? ¿Intencionalidad de los carceleros? ¿Cómo era posible que en un mismo módulo juntaran a traidor y traicionado? ¡Daba igual!, y cuanto antes lo solucionase, antes sabría a qué atenerme. Aunque hubiese querido no habría podido dejarlo pasar. Una muestra de cobardía, un síntoma de rehuir el enfrentamiento, y una mañana, cualquier noche, hubiera notado un cuchillo atravesándome la espalda.

Aquel saco de basura humana seguía sin darse cuenta de mi llegada, o quizás…¿mi recuperación y renovada apariencia me habían hecho irreconocible? ¡¡¡NO!!! Estaba entretenido, despistado junto a un numeroso grupo de colegas; pero no podía enfrentarme a todos ellos.

Entré en el váter. Extendí un periódico en el suelo. Me acuclillé encima. Apreté la tripa con fuerza y el estuche del recto vació su contenido. Limpié el paquete en el lavabo. Rasgué el condón que hacía de funda y allí estaba, brillante y agresivo, mi estilete de doce centímetros de hoja.

En el momento de salir de los servicios, y cuando tenía previsto lanzarme por él en mitad del patio, la suerte tomó otro rumbo: el mío, el contrario al de mi enemigo. El Tenazas, confiado, sin sospechas de ningún tipo, necesitó descargar la bebida.

Me oculté tras la puerta. Vi su nuca al pasar. Se acercó a la letrina. La bragueta liberó el pene. Tenía las manos ocupadas cuando, en silencio, le

puse el pincho en la garganta. "¿Te acuerdas de mí, chivato? Si te mueves te ensarto", le amenacé al oído sin darle oportunidad a la defensa. El extremo del punzón le comenzó a provocar un hilillo de sangre. Reconoció mi voz, Pude oler el río de sudor de aquel asqueroso y sentir el pánico recorriendo su cuerpo.

- Me tenían pillado, Dabuti. Si no colaboro con la "pasma" me habrían cargado un "mullao". No habría salido de prisión en la vida. Te compensaré,,,¡Tengo jaco! – intento congraciarse mediante todo tipo de falsedades y ofrecimientos.

- Si te mueves te mato – le repetí ansioso porque me contrariara dándome el motivo, el impulso final, para acabar con su miserable existencia.

No se movió. Decidí indultarlo. "¡Pon las manos sobre la cabeza!, le exigí. Las puso. "¡Júntalas!, le ordené. Lo hizo. Y agarrándole aquellos cuatro dedos que le quedaban, sin darle otras oportunidades que las que recibí de él cuando me entregó a la policía, quite el estilete de su cuello y, de un rápido, certero y profundo tajo, seccioné los tendones de sus muñecas. Aulló. Salió disparado hacia la garita de los carceleros dejando un rastro rojo en su camino. Y aquellas dos manos, cuatro dedos, dos tenazas, se habían quedado sin resortes y jamás recuperarían la movilidad.

Fui al economato. Tomé un café. Llegaron numerosos funcionarios y dos jefes de servicios:

- ¿Qué ha pasado?

- Nada – respondí

- ¡¡¡A AISLAMIENTO¡¡¡

-¡Vale! Exclamé convencido de que ello no perjudicaría mis propósitos de fuga.

- ¿Dónde tienes el cuchillo?- preguntó el jefe de servicios.

- No tengo nada – contesté en el momento en que un carcelero chillaba desde la entrada del váter: "Está aquí. Lo había escondido en la cisterna…" Y mi estancia en el módulo tres duró menos de una hora.

Todos estaban tensos: menos yo. Total…¿qué podían hacerme que ante no me lo hubieran hecho ya? Además, en esta ocasión, no había tocado a ningún funcionario y, mientras a ellos no se les molestase, todo estaba permitido o, al menos, no demasiado castigado. Me engrilletaron sin que opusiera resistencia y, rodeado por una enorme plantilla de uniformes azules, llegué al nuevo destino.

El siete de aislamiento era un departamento especial: antisecuestros, lo denominaban. Tres plantas de celdas en las que únicamente la intermedia se encontraba en uso. El piso inferior lo habían convertido en almacén de objetos y ropa – casi toda – no autorizada a los internos, y el superior permanecía totalmente abandonado.

No conocía aquel módulo celular, pero había oído hablar de él y de su fama de seguro para los funcionarios, la cual se debía a la imposibilidad de contacto directo con los allí encerrados, al existir, siempre, una puerta de separación entre los carceleros y encarcelados.

Cancelas de entrada, puertas de patio, pasillos y celdas mecanizadas. Control visual mediante cámaras de televisión. Ordenes, preguntas y respuestas, a través de la megafonía. Y todo ello controlado desde áreas de

seguridad para los funcionarios. "Bueno…, tampoco voy a estar mucho tiempo aquí…", pensé.

- ¡¡¡DESVISTASE!!!, y déme la ropa entre los barrotes de la cancela – exigió un carcelero en cuanto pasé la primera puerta de acceso.

Sin mirarlo, sin hablarle, conteniendo el asco que me producía y pensando en el aliciente de la huida, le fui entregando la ropa, prenda por prenda, hasta quedar desnudo.

- "¡Póngase de cuclillas! ¡Haga flexiones! ¡Recoja la ropa! ¡Vístase! – fueron órdenes que escuché hasta que se dieron por satisfechos.

La celda, un calabozo como otros muchos, tenía una pequeña pero importante diferencia: su puerta, también, la manipulaban desde la distancia. Me puse frente a ella. Sonó una orden por el altavoz: "¡Entre", y se cerro tras de mí. Siempre sucedía igual, y ese mecanismo iba a se mi billete de salida de prisión.

Los días transcurrían en medio de la rutina; una hora de patio por la mañana y otra por la tarde, siempre en solitario. Horas de paseo, por el borde de la pared, sin poder hablar ni volver la cabeza hacia la celda donde se encontrase algún otro compañero. De no hacerlo así, volvía a sonar la megafonía: "Se ha terminado su tiempo. ¡Suba a la celda!", y ante la negativa a abandonar el patio aparecía la plantilla de uniformes con su parafernalia de cascos, escudos y grilletes. Yo siempre acataba las órdenes sin rechistar y empecé a ser un preso modelo.

Tras aguardar cuatro meses y cursar una docena de instancias contestadas sistemáticamente con un escueto "NO PROCEDE", llegó la respuesta esperada: "Se le autoriza comunicación vis a vis íntima para el día…"

Al abrir la puerta de la celda-habitación, Amaia, ya se encontraba en el interior. Cuantas más veces la veía, más perfecta se hacía ante mis ojos,

resultándome imposible comprender el motivo por el cual me quería. Nos dimos un beso. La miré. Observé a su alrededor aquella celda adaptada para intimidades de una hora, la cama desvencijada por el peso de mil cuerpos, y el contraste se hizo insalvable. "Si llevamos meses sin tocarnos, aguantaremos unos días más", pensé.

- No he traído preservativos, ¿tienes tú? – preguntó interrumpiendo mis pensamientos.

- No, pero da igual. Hoy no los vamos a necesitar.

- ¿Por qué?- se quedó extrañada.

- Porque estoy asqueado de que nos pongan día, hora y tiempo para follar. Cansado de que nos echen una ración de sexo como a animales enjaulados. La próxima vez lo haremos fuera de aquí: dónde queramos, cuando queramos…

- ¿Qué te sucede? ¿Estás mal? ¿Sabes cuántos años te quedan?

- Serán días. Me voy a fugar. ¿Cuento con tu ayuda? – bajé la voz hasta hacerla audible sólo junto a su oído.

- ¿Qué necesitas?

- Nada que te comprometa. Ni siquiera te contaré cómo lo voy a intentar, pero estoy convencido de que saldrá bien: no fallaré.

- ¡Dime! ¿Qué puedo hacer?- insistió, extrañándome su decisión y falta de curiosidad.

- Es sencillo. Cuando salga quiero recuperar a las niñas y marcharnos lejos, los cuatro. ¡Tenlas localizadas! Además, la policía irá donde ti. Trasládate a un piso que no conozca nadie, dime el sitio y espera: tocaré a tu puerta.

- ¿Cuánto tiempo?

- En el momento en el que tengas la nueva dirección, y la suerte esté de mi lado, allí apareceré.

- A tus hijas continúo viéndolas todas las semanas, y el lugar donde juntarnos te lo puedo decir ya; en él no nos encontrarán. ¿Quieres saberlo? – y me dio las señas.

Cinco semanas más tarde, como todos los días, llegó la hora de patio (las once) con un sol magnífico y una temperatura primaveral. Sonó el interfono: "¿Está preparado para disfrutar de su tiempo de paseo?", y salí cerrándose la puerta a mis espaldas. Caminé unos minutos. En un rincón había un montón de periódicos atrasados. Tomé uno cualquiera. Lo abrí por la página de mayor credibilidad – el horóscopo – y, para Leo, pronosticaba: "Es el momento de seguir avanzando en tu camino. Hallas soluciones a tus problemas. Significa el fin de una dura etapa de tu vida. Disfrútala y sácale el máximo provecho. Todo lo que emprendas hoy estará destinado al éxito".

¡¡¡POR FIN, HABIA LLEGADO EL DIA!!!

En una esquina del patio se encontraba situado un pequeño váter siempre atascado y repleto de orines; pero con un grifo que, en ocasiones, echaba agua. Giré la llave de paso y no funcionó. ¡Daba igual! Simulé ruido de arcadas, de vómitos, agitando con las manos los pestilentes líquidos del inodoro. Me mojé la frente, la boca, y, con el rostro descompuesto por la repugnancia de aquellos olores, me dirigí al área de seguridad de los carceleros: "¿Qué le pasa?", preguntó uno de ellos en cuanto me acerqué.

Les conté que había enfermado, que acababa de vomitar, que estaba mareándome y necesitaba volver a la celda. Aceptaron. Comenzó a abrir y cerrar las puertas eléctricas. A mi espalda se cerró la del patio, la de

las escaleras, la de la galería, y se debía haber cerrado la del calabozo. Llegué a ella. Me detuve delante. Un lejano carcelero apretó algún distante botón, y la pesada puerta de hierro se abrió desplazándose hacia mi derecha, sobre sus engrasados raíles de acero. ¡¡¡ENTRE!!!, ordenó una voz chillona por un interfono metálico. Obedecí. Desde lejos, el mismo funcionario – u otro semejante- presionó un interruptor similar, y la gruesa puerta comenzó a cerrarse. Cuando únicamente le quedaban unos centímetros para llegar al final…, tomé aire, apreté los dientes y saqué el brazo.

Escuche cómo, en el intento de juntarse hierro y acero, mis huesos crujían. Un enorme latigazo me sacudió el cuerpo; un dolor intenso nubló mi razón; y la garganta liberó desgarradores aullidos de sufrimiento, mientras el machacado antebrazo colgaba partido en dos.

- ¿Qué sucede? – preguntó el altavoz, haciendo una excepción en sus rutinarias órdenes.

- TENGO…EL BRAZO…ROTO. APRISIONADO EN…LA PUERTA. ESTABA MAREADO…Y LA HAN…CERRADO…CUANDO ME…ENCONTRABA APOYADO…- me expliqué de forma entrecortada, haciendo esfuerzos sobrehumanos para no derrumbarme del dolor.

La puerta liberó su presa y el suelo de la celda me sirvió de colchón. Tras una larga espera, un carcelero de bata blanca y función de sanitario llegó, miró y decidió: "Hay que llevarlo al hospital".

La ambulancia era nueva, parecía limpia, y exhibía un cartelito (sellado por el Ministerio de Sanidad) que aseguraba se habían eliminado las ratas y parásitos de dentro: eso decía el cartel…Los guardias civiles eran viejos, de uniformes arrugados y apariencia de recién levantados de la siesta. Protestaban entre ellos por el traslado imprevisto. Se quejaban de los pocos efectivos asignados a los servicios urgentes. Y gruñían malhumorados con sus mandos por ser sólo tres.

- ¿Le pongo grilletes, mi cabo? – preguntó uno de los dos números, sin duda próximo a la jubilación, mientras sostenía unas esposas en la mano.

-¿Dónde se las vas a poner, hombre! No ves que tiene el brazo destrozado – contestó el mando.

- En el pié, mi cabo.

- Sí, eso sí.

Al tumbarme en la camilla, me encadenaron el tobillo a una de sus barras laterales, y, con el comienzo del aullar de la sirena y el destellar de las luces, emprendimos un rápido viaje hasta la residencia de la Paz, ya que también formaba parte de la rutina el que la asistencia médica de urgencia a los presos de Alcalá-Meco la realizaran en aquel gran centro sanitario.

La entrada de urgencias era un mare mágnum de vehículos y personas. Ambulancias y coches particulares entraban y salían del aparcamiento, para desprenderse o recoger pacientes y familiares, que se mezclaban con los celadores y personal sanitario. Entre todos ellos, el cabo de la benemérita institución intentaba que me atendieran, preguntando en uno y otro lado. Finalmente, alguien le informó del lugar donde se encontraba el departamento de traumatología.

- ¿Bajamos la camilla, mi cabo? – preguntó uno de los números.

- ¡No, hombre! Suéltale el tobillo y que camine. ¡Llévalo del brazo! – y mientras uno de los guardias se quedaba al cuidado del vehículo, el otro me agarró por el brazo sano y me hizo seguir al mando.

El médico fue atento. Radiografías: cúbito y radio rotos. Anestesia local: reducción de fracturas. Escayola. Tratamiento para el dolor y alta médica en un tiempo mínimo: todo en menos de una hora.

- ¿Le pongo los grilletes, mi cabo? – preguntó el número, que mostraba una auténtica obsesión por las cadenas, y empezaba a ponerme nervioso.

- ¡No ves que no se puede encima de la escayola? ¡Agárralo del brazo y en la ambulancia le vuelves a esposar el tobillo!- repitió el mando, igual que una hora antes.

Le di las gracias al médico. Salimos al vestíbulo de recepción, que a la hora de la comida se encontraba abarrotado de visitantes. El sudoroso mando caminaba delante. El prejubilado número y yo le seguíamos detrás. El cabo cruzó la puerta de salida hacia el aparcamiento, momento en el que, con todas mis fuerzas, le arreé al subordinado con la escayola en la cara. No necesitó más de un golpe para soltar la presa y echarse las manos al rostro. Comencé una veloz carrera, volviendo sobre el camino andado, esquivando a cuantas personas encontraba al paso y que entre el ruido general apenas se daban cuenta de lo sucedido. ¡¡¡ALTO O DISPARO!!!, escuché de lejos seguro de que no lo harían allí dentro. Bajé escaleras. Recorrí pasillos sin ni siquiera mirar atrás y convencido de que, si pretendían seguirme, aquellas pesadas tripas no lo podrían hacer durante muchos metros. Cuando llegué a los sótanos, y me detuve a tomar un respiro, estaba solo.

El médico era un excelente traumatólogo y la escayola aguantó el leñazo, aunque, también es cierto, se agrietó en la parte central. Es de suponer que la cara del guardia obsesionado por los grilletes no salió mejor parada; pero no me quedé para mirarlo.

El efecto de la anestesia, de la medicación, comenzaba a pasarse, tanto como iba en aumento el dolor del brazo. Además, o salía de allí cuanto antes o no tendría muchas posibilidades de lograrlo.

Mientras corría por aquellos enormes sótanos (un mundo subterráneo de servicios para el centro hospitalario) entre sacos, calderas, paquetes

y todo tipo de maquinaria, pensaba en Purita y tenía la sensación de que el tiempo no había pasado y que al final del oscuro laberinto la encontraría en su habitación: esperándome.

Localicé un recordado montacargas ante la mirada indiferente de un empleado de almacén. Llegué a la planta baja. Entré en un despacho vacío. Abrí la ventana. Salté al exterior lejos de donde se escuchaban numerosas sirenas (en el extremo opuesto del complejo sanitario) y me dejé engullir por el bullicioso tráfico de la hora punta metropolitana.

El edificio, en la dirección proporcionada por Amaia, era inmejorable. Un enorme bloque de apartamentos y estudios de alquiler, para personas en tránsito y anónimos vecinos. ¡¡Magnífico!!, no había portero o, al menos, se encontraba ausente a primeras horas de la tarde. Pulsé un timbre al azar: ¿Quién es?, contestó una voz somnolienta. "El cartero", respondí, y escuche el clic que me franqueó la entrada del portal.

Tome un ascensor. Llegué a la planta deseada. Encontré el pasillo que correspondía a la letra del apartamento. Busqué la puerta indicada por Amaia y toqué el timbre: no contestó nadie. Insistí y no obtuve respuesta. "¿Me habré equivocado de dirección?, pensé. Volví a comprobar el portal, planta, pasillo y letra.

- ¡¡¡NO!!! , no me había confundido, pero todo no podía salir bien- me dije.

Es verte obligad@ a vivir un cacheo, ver como entran en tu celda, arrasando con todo, invadiendo tu pequeño mundo, tu intimidad, tu vida,... Destrozando todo lo que para ell@s no tiene ningún valor, tirando todas tus cosas como si se tratase de basura, mientras que tú, desde la puerta, te conviertes en un/a espectador/a impotente, esperando a que ell@s terminen su gran festín, dejando todo invadido, arrasado, violado,...

Cárcel es el intento continuo de aislarnos del exterior, es el intento abrasador de no dejarnos formar parte de vuestras vidas, sueños, historias, locuras, problemas, experiencias,... y que vosotr@s no forméis parte de las nuestras, de sentiros cerca...; haciendo que las cartas tarden meses en llegar o perdiéndolas en los cajones de sus lujosas oficinas, violando cada palabra con su lectura.

Cárcel es que te separen de tu bikote, sufrir la angustia de la separación, algo para lo que nunca se está preparad@. No saber cuándo vas a volver a estar con él, con ella; no saber cuándo le vas a poder volver a tocar, abrazar, acariciar, besar,...

Es que te priven de la maternidad, paternidad,... o que te castiguen con el aislamiento por haber decidido ser madre. No poder ver crecer a tus hij@s, sobrin@s, herman@s,... No poder estar a su lado, compartir cada instante, escucharles, enseñarles,...

Es vivir con la incertidumbre de no saber que será de ti, de no saber donde estarás mañana, ni con quien, ni en que condiciones. No saber cuanto tiempo, ni las vueltas que te darán de cárcel a cárcel como si fueses un paquete que no siente. El miedo de saber que te puede tocar vivir una pesadilla, vivir en condiciones infrahumanas, lejos de casa, de tu familia, amig@s,... intentando a cada instante que te sientas completamente sol@, vulnerable, desprotegid@, aislad@, abandonad@,... una vez más deseando anularte como persona, romperte en mil pedazos, robándote tus sueños...

No son conscientes de lo ilus@s que pueden llegar a ser, seres tristes e ingenuos. ¿Realmente pensaban que iban a conseguir su objetivo, que iban a conseguir destruirnos?

Carecen de cualquier poder sobre nosotr@s. Ell@s podrán tener toda su maquinaria represiva, destructiva, inhumana, dañina... pero nosotr@s tenemos lo más importante, tenemos la fuerza, las ganas de seguir con el camino que un día emprendimos, la vitalidad para seguir haciéndole frente a cada nuevo ataque...

Aún nos queda mucho que sentir, mucho que vivir, infinidad de cosas que experimentar, miles de errores que cometer, cientos de momentos que compartir, millones de personas que conocer, innumerables lugares por descubrir, miradas con las que conectar... Aún nos queda mucho por soñar para considerar que nuestras vidas ya no nos pertenecen, que se han terminado. Nuestros corazones tienen muchos motivos por los que seguir latiendo, muchas sonrisas con las que despertar para romper con su falta de color, demasiados sueños por realizar...

Somos cautiv@s libres. Nos podrán robar lo material, nos podrán privar de libertad física, pero nunca podrán quitarnos la capacidad de sentir, de soñar... porque lo que tenemos dentro nunca nadie nos lo podrá quitar, y eso nos hace soñar y volar, nos hace personas, nos hace libres... Seres libres que nunca dejarán de SENTIR.

*Espetxea ezagutu duten guztiei*
*Espetxea bizi duten guztiei*
*Kide guztiei*
*Gure artean ez daudenei*
*Senideei bidea errazteagatik*



**Kerman Urizar de Paz**
1967
Bilbo

1991 urtean espetxeratu zuten.
Almeriako espetxean dago.



C. P. El Acebuche
Apdo. 221
Ctra. Cuevas de las Ubedas, km. 2,5
04.130 El Alquian
Almeria



**Oier Gonzalez Bilbatua**
1979
Durango

2005. urtean preso hartu zuten.



Maison D^arrêt
Tolouse-Seysses

## Xoriak pausatu dira

Xoriak pausatu dira gure baitan.

Gaur goizean, esnatu eta leihoan paratu naiz. Elurra mara-mara ari da inguruak txuriz margotzen. Giroari darion usainak, ikastolako garaietara garraiatu nau. Nola aritzen ginen etxerako bueltan elur-bolak elkarri jaurtiaz. Atzamarretan hotzaren hotzez, mina izan arren, espaloiaren bestaldean zeuden kontrarioei, arnasa hartzen utzi gabe, dinbi-danba.

Teilatuan edo batek daki non abia egin duen itxas-txoria atzera eta aurrera dabil, janari bila. Elur txurian lorratz utzi ditu bere korrakaldi ernean. Leiho azpian dauden zakar poltsak, janari erdi ustela eta alboko leihoetatik jendeak botatzen dituen moeta guztietako detritusak, elurrak ezkutatu ditu. Gaur, inguruko zikinkeriaz beti protestaka ari den Jean-Louis pozik egongo da, elurrak zaborra menditxo ezezagunetan bihurtu baitu. Pareko futbol zelaia ere txuri-txuri ageri da, kondizio hauetan, seguraski ez diote inori bertara joaten utziko.

Neguko goiz hartan, instant batez izan bada ere, harrapatuta gaituen errealitate gordina, izara txuri batek estali du. Baina zeinen efimeroa den materia txuri hau. Eguerdiko eguzkiaren lehen printzekin, elurra urtzen hasi da eta berriz ere agerian geratu dira inguratzen gaituen alanbradako aizto zorrotzak, guri mehatxuka.



**Xabier Aranburu Muguruza**
1962
Usurbil

1991ean atxilotu zuten.



C.P Herrera de La Mancha
Apdo.77
13.200 Manzanares
Ciudad Real

*Bertso xorta honekin "Sagarrondotik dator sagarra" gaia hartuta irabazle gelditu zen Xabier Aranburu Usurbilgo herrian Sagardo Egunaren 25. urteurrena ospatzeko antolatu zen bertso-lehiaketan.*

## Sagarrondotik dator sagardoa

1.
Sagarrondoren soina
dotore udaberritu
adarretan hosto obalak
lore zuriz erne ditu.
Eguraldia xurgatuz
koxkorrak zaizkio gehitu
haize, euri ta eguzkiaz
egiten baitira hornitu
denboraren poderioz
adarrak dira uztaitu
zamaren zamaz sagarrak
ezin direla kabitu
helduenak lurreratuz
sagarrondoa erditu
bekatuaren fruitua
jan gabe ez gaiten gelditu.

2.
Sagarrondoen orpoak
daude sagarrez beteta
eta baserritarrak prest
dira egiteko bilketa
egitekoari jarriz
berebiziko arreta,
esperientzia lagun
bihurtu zaie olgeta
sagarrek galdu ez dezaten
kalitatea kolpeka
kizkiaz egin diete
ziztada baten fereka
ardura handiz uzteko
zakutan ongi gordeta
sagardoa egiteko
lehengaia dira eta.

3.
Sagar garbi ederrekin
kirikoketa hasi da
mazoen golpe lehorrez
txirtxilaturik neurrira.
Guztiz desitxuraturik
eta galdurik distira
sufrimenduaren sokak
jada ezin ditzake libra
dolare bihozgabeak
hartua baitu segida
sagarren bihotz-arimak
tinko estutuaz di-da
patsa ondo xehatu arte
ez du izango gupida
mama gozoa negarrez
txorrotean ageri da.

4.
Muztioa txorrotadan
badoa kupelerantza
lau-bost hilabeterako
errespetatuz usantza.
Kupelaren besoetan
etzaio faltako dantza
soinean izango baitu
hartziduraren arantza.
Bi irakinaldirekin
datorkio akabantza
jada ondo gorpuzturik
joana zaio balantza
usain eta zaporeak
baieztatzen dute, antza
sagardo bikain-bikaina
izango den segurantza.

5.
Txotx garaiak dizu arindu
kupeleko martiritza
ilunpeko zoritxarra
bihurtu baitizu ditxa.
Ireki dizutenean
askatasunaren giltza
ikustekoa zen zure
abiadura bortitza
baso ertzean lehertuz
ospatzen duzu garaitza
txinparta darizularik
kabitu ezinik zabiltza
bihotzak dantzan jarriaz
jolas ederrean hitza
zu gabe ai ze tristea
litzatekeen bizitza.

6.
Txotx bolada pasa arren
sortzen darraizu lilura
usain eta zaporeak
jo dizutelako muga
bospasei gradu artean
ereduaren modura
botilaratu zaituzte
eramanez merkatura
iaz Madrilgo perian
eduki zenun mentura
aurten aldiz Kataluñan
sustatuz euskal kultura
kalitatea jarriaz
bezeroaren eskura
gure arbasoen sustraiak
zabal ditzazun mundura.

7.
Sagardo eguna zela
ezin inolaz ahaztu
kolore ederrarekin
botilan zeunden hain justu
kortxoa askatuz gero
edozertarako prestu
lotsa gutxikin baitzinen
baso batean biluztu,
eskuan goxo hartuta
tragoan zintudan hustu
Hura zen hura zirrara
gorputz osoan ze gustu
probatu izan ez bazintut
ezingo nuen sinistu
bihotzean baitzenidan
maitasun argia piztu

8.
Zurekiko maitasuna
sutsu dezadan seinala
izan baita hogeita bost
urteko ezkontza formala
zintzoa izan natzaizu
fidela eta leiala.
noizbait harrapatu arren
mozkor bihurri petrala
harro diotsut oraindik
hauxe gertatzen zaidala
maitekiro zu basotik
neurrian edan ahala
pasioaren sugarra
etortzen zait berehala
zure ezagutza egin
nuen unean bezala.



**Joakin Agirre Goenaga "Txe"**
1953
Zizurkil

1978. urtean alde egin zuen Zizurkiletik eta 1981ean Venezuelara jo zuen.
2003. urtean KARIBETIK KANTAURIRA bertso bilduma liburua argitaratu zuen Paper Hotsak argitaletxean . 2006ko irailaren 16an itzuli zen Zizurkilera EHNA eskuan.

## Euskal preso eta iheslari politikoei

I

SUFRIMENDUAK EZ DU MUGARIK
PRESOAK DIRELA ETA.
LIBRE IBILI BEHAR LUKETEN
BIDEA ZAIE DEBEKA.
HERRI BORROKAK HARTU DEZALA
ZINEZ ASKATZEKO BETA.
IZAN DEZATEN OREKA.
BEHAR ZAIE ERRESPETA.
LIBRE IKUSI ARTEAN PRESO
BAKOITZAREN TXIMELETA.
EZINGO DUGU INOIZ BUKATU
EUSKAL BELARRAREN META.

II

BEGIRUNEA ZOR ZAIE DENEI
ARRAZOITAN SARTU GABE.
EZER BAINO LEHEN DITUGULAKO
EUSKAL HERRIKO LANDARE.
DUINTASUNAREN OGI BERRIAK
BEROTZEKO DAUKAN LABE.
EUSKAL SAGAR TA UDARE.
ARBASO ZAHARREN ONDARE.
ASKAPENAREN ABIADURA
OREKATZEKO ENBRAGE.
SASI TARTEKO OIHARTZUNA TA
ESPERANTZAREN ZUTABE.

III

URRATSEZ URRATS NAHIZ BIDE ZAILAK
SUFRIMENDUZ ZEHARKATU.
URAK AZKENIK EUSKAL ERREKAN
BEHARKO DU BESARKATU.
ETSAIAK NOSKI AZPIKERIAN
SARRITAN DIGU JOKATU.
GIZALEGEAK PUSKATU.
ESKUBIDEAK UKATU.
BAINA ALFERRIK ZUEN AURKAKO
HAINBAT HITZARMEN ASMATU.
ZEREN NORTASUN GURPILA BEHINTZAT
EZ DUTELAKO ZULATU.

IV

ZINTZOTASUNA EZ DAUKAZUE
INONDIK ERE SALTZEKO.
NEGU OSOA PASATZEKO PREST
UDABERRIRA HELTZEKO
SARE MUGA TA KATEAK HAUTSIZ
ASKATASUNA LORTZEKO.
BIDE-BURUTAN HITZEKO.
TAUPADA OSOA HARTZEKO.
EZIN BESTEKO ERAGILEAK
GATAZKA BIDERATZEKO.
ZUEN JARRERA HITZ XAMURRETAN
DUGU TXAPELA KENTZEKO.

V

DUINTASUNEZ EUSKAL HERRIKO
TROPEL ZAHARRARI TIRAKA.
ZENBAT ESPETXE ZENBAT ERBESTE
BETI HORTXE TIPI TAPA.
BIDETXURRETIK BIDETXURRERA
ETA ALDAPAZ ALDAPA.
EKINTZA BAI EZ KALAKA.
BELAUNALDI TA ETAPA.
HISTORI HONEN ZURRUNBILOAN
JOAN ZAIZKIGU EHUNDAKA.
KOLORE BIZIZ JOSI DUTENAK
EUSKAL HERRIKO HAMAKA.

VI

MENDIKO BRISA LEKUKO DELA
BELAUNALDIZ BELAUNALDI.
BELAR FRESKOAN BILA USAINKA
BUSTIZ BELARDIZ BELARDI.
IBILI ZIREN ETA DABILTZA
HAINBAT ARKUME TA ARDI.
OTSOEN AURKA AUSARDI.
SENTIPEN SAKONEZ GARBI.
HERRI ZAHARRARI ARGI EGITEN
GAU ILUNEAN ILARGI.
EGUZKI PRINTZA MARGOTZEN DUEN
ZERUERTZEKO OSKARBI.

VII

ETENGABEKO OIHARTZUNA DA
JOTZEN DUZUEN TURUTA.
SINESMEN HORREN BIDE GARRATZAK
MUGA ITXIRIK EZ DAUKA.
OLATU ZAKAR ANITZ GAINDITUZ
AURRERA DOAN TXALUPA.
MIRESGARRI DEN KONDUKTA.
DUGU GAUR ZUEN BURRUKA.
ZUEI ESKER OREKATZEN DA
ASKATASUNAREN TAUPA.
BARNE INDAR HORREK ESENTZI ZUKU
LEHOR EZINAK DITU-TA.

VIII

ZUHAITZ ZAHARRAREN SUSTRAIAN DAUDE
BASOKO MILA SEKRETU.
ORBEL XIMELAK HOSTO FRESKOAK
AMETS DIREN GORDELEKU.
NEGUKO EKAITZ BORTITZAK NAHIZ TA
UDABERRIA DEBEKU.
JASANEZ HAINBAT MENDEKU.
ONGI ZARETE JABETU.
ZERGATIK ZIREN? ZERGATIK DAUDEN?
ZUHAITZ ZAHARRARI GALDETU.
TA ERANTZUNA JASOTAKOAN
BIHOTZAK BAIETZ ULERTU.

*Hendaia, 2006ko Urria*



**Joxe Karlos Apeztegia Jaka**
1964
Iruñea

1992 urtean atxilotua.



C. P. Huelva II
Carretera de la Rivera
21.610 Huelva

## 1981ean gertatu zen

1981ean gertatu zen. Hamar mutil ziren. Gazteak ziren (zaharrenak 30 urte baino ez zituen). Irlandarrak ziren. Preso politikoak ziren, Irlandaren askatasunaren aldeko borrokalari jator eta zintzoak, eta sorterriarekiko engaiamendua azken muturreraino eraman zuten, bizitza utzi baitzuten borroka hartan.

25 urte iragan dira geroztik, baina hamar borrokalari gazte hauen oroimenak inoiz baino biziago dirau, Irlanda hunkitu zuen borroka latz, zintzo eta paregabe horrek piztutako sua ez baita itzali.

Irlanda aske eta batua nahi zuten, britainiarren uztarpetik aske litzatekeen Irlanda burujabea, eta bizitza eman zuten helburu horren alde. Borroka hartan bizitza galduko zutela bazekiten, heriotza zain zutela borrokarekiko atxikimendua muturreraino eramanez gero, baina ez zuten atzera egin.

1970eko hamarkadan Irlandako preso politikoek bizi-baldintza izugarriak pairatzen zituzten britainiarren esku Long Kesh espetxean. Egoera hori aldarazi nahi zuten, baita preso politiko gisa zegokien estatutua lortu ere, eta borroka ezberdinak burutu zituzten helburu hori lortu nahirik.

1976an burusiaren greba burutzen hasi ziren, espetxeko uniformea eramateari uko egin baitzioten presoek, eta gorputza estaltzeko burusi bat besterik ez zuten erabiltzen. "Uniforme hau eraman dezadan bizkarrean iltzatu beharko didazue", hauexek izan ziren uniforme eramateari uko egin zion lehen preso politikoaren hitzak.

1978an burusiaren grebarekin jarraitzen zuten preso politikoek eta urte horretan bertan ere zikinkeria grebari ekin zioten.

1980an irlandar preso politikoen egoera jasangaitza zen, beraien aurkako kriminalizazio prozesua biziki gogorra baitzen ("Ez dira borrokalari politikoak, bihotzik gabeko hiltzaile odolzaleak baizik", zioten britainiarrek). Hori zela eta, britainiarrei hortzak ongi asko erakutsi behar zitzaizkiela erabaki zuten presoek.

1980ko urrian gose grebari ekin zioten presoek, estatutu politikoa lortu nahirik, baina abenduan bertan behera utzi zuten, gose grebalari bat koma egoeran sartu ondoren, britainiarrek preso politikoen eskakizunak onartuko zituztela esan zutelako. Esan bai, baita egindako hitza jan ere.

Hortaz, estatutu politikoaren aldeko borroka gogortu beharra zegoen.

Irlandar preso politikoen batzarrak 5 puntuko taula bat osatu zuen eta britainiarrek eskakizun hauek lortu arte borroka egin behar zutela erabaki zuten. Gose greba mugagabea abiaraziko zuten eta borroka mota honek ez zuen etenik ezagutuko, baita hil arteko gose greba burutu behar bazen ere. Ezin zuten hutsik egin oraingoan eta egoera jasangaitz hura irauli beharra zegoen behin betiko.

Gose greba txandaka burutuko litzateke eta gose grebalariak boluntarioak izanen lirateke. Gose grebalari guztiek ez liokete ekingo gose grebari egun berean, beraien artean bi asteko tartea utziko baitzuten. Lehenbiziko gose grebalariak borrokari ekin eta bi aste geroago hasiko luke txanda hurrengoak. Honela, bi asteko tartea lortuko litzateke borrokalari guztien artean eta borrokak gehiago iraunen luke.

Britainiarrei ere ez zieten propaganda beltza egiteko aukerarik eman behar, eta borroka latz honetan parte hartuko zutenak ez ziren zigorrik handienak hartuta zeudenak.

Zoritxarrez, esan beharra dago hau ez dela batere borroka molde berria irlandarrentzat, 1921ean Cork-eko auzapeza ere hil baitzen gose greba luze baten ondorioz. Irlandar preso politikoek erabaki gogor hau hartu baino 50 urte lehenago, Cork-eko auzapezak ere gose grebari ekin zion,

espetxean ere, Irlanda aske, burujabe eta britainiarrekiko morrontzarik gabe nahi zuela aldarrikatzeko, eta britainiar espetxe batean eman zuen azken hatsa.

1981ean Bobby izan zen heriotza galdu zuen lehena, Bobby Sands, Belfastekoa. IRAko borrokalaria zen eta gose greban 66 egun eman ondoren 1981eko maiatzaren 5ean hil zen, 27 urte zituela.

Belfasteko mutila ezagutu zutenek soldadu ona izan zela diote, baina denak bat datoz Bobby giltzapean askoz soldadu hobeagoa izan zela esatean (*"He was a good soldier, but he was better soldier in prision"*), Long Kesh espetxeko hormak Bobbyren borrokarako dohain bikainen lekuko bihurtu baitziren.

Bobbyk egunkari bat idatzi zuen gose grebaren lehenbiziko 16 egunetan, eta hasieran zalantzak zituela antzeman daiteke, baina nork ez zukeen zalantzarik izanen Bobbyren egoeran egon izan balitz? Britainiarrek esan zuten Bobbyk beldurra sentitu zuela azken unean, baina Bobbyk aurrera egin zuen eta, gainerako bederatzi gazteekin batera, Irlandaren historian sartu zen betiko. Lehenago esan dugu; *"He was a good soldier"*.

Bobby idazle, olerkari eta kantugile ezaguna zen, liburuak idatzi eta kantuak osatu baitzituen.

Hilzorian zegoela, hil baino egun batzuk lehenago, Bobby MP hautatu zuten 30.000 hauteslek. Bobby *Member of Parliament* bihurtu zen, eserlekua lortu baitzuen Londreseko parlamentuan 30.000 hauteslek emandako sostenguari esker, baina britainiarrek ez zuten ezertxo ere egin parlamentuko kide baten bizitza salbatzeko. Inork ez zuen uste britainiarrek Bobby hil zedin utzi behar zutenik, baina ez zuten ahaleginik txikiena ere egin Bobbyren bizitza zaintzeko.

Bobby hil zen gau berean albistea laster zabaldu zen Ipar Irlandako herri eta auzo guztietan. Hainbat herritako bizilagunak (Belfast, Derry, Newry, Omagh…) burdinazko zakarrontzien estalkiak hartuta zoruaren aurka jotzen hasi ziren, eta hauxe zen bazter guztietara zabaltzen zuten mezua: "Bobby hil da".

IRAko borrokalarien heriotzari buruzko albisteak britainiarren aurkako amorru eta gorrotoari atea ireki zion eta gau horretan bertan Belfasten soilik indar zapaltzaile britainiarren aurka 100 eraso baino gehiago burutu ziren. Britainiarrekiko gorrotoa bizi-bizirik agertu zen eta egoera hartzen ari zen bidea ikusita, IRAk lasaitasunerako deialdi bat egin behar izan zuen, abertzale irlandarrek barruan gordea zuten gorrotoa eztanda izugarri baten antzera azaldu baitzen Bobbyren heriotzaren berri jaso bezain laster.

Bobbyren omenezko ekitaldiak Belfasten inoiz ikusi gabeko jendetza izugarria bildu zuen. 100.000 lagun inguruk lagundu zuten Bobbyren gorpua zeraman hilkutxa Belfasteko hilerriraino, IRAren ohorezko guardia batek hilkutxa zaintzen zuelarik. Bobbyren izena Irlandaren historia sartua zen betiko.

Bobbyren heriotzak ez zituen kikildu giltzapeko gainerako borrokalariak, britainiarrek ez baitzuten helburua lortu, horixe baldin bazen nahi zutena, eta preso politikoak kemen handiagoz lotu zitzaizkion borrokari.

Hurrengoa Francis Hugues izan zen, IRAko borrokalaria, 1981eko maiatzaren 12an hil zena, gose greban 59 egun eman ondoren, 25 urte zituela.

Raymond McCreesh ere IRAkoa zen, preso irlandarra, besteak bezala, eta 1981eko maiatzaren 21ean hil zen, gose greban 61 egun eman ondoren, 24 urte zituela.

Patsy O´hara Derrykoa zen, INLAko borrokalaria, Irish National Liberation Army, eta 1981eko maiatzaren 21ean hil zen, gose greban 61 egun eman ondoren, 24 urte zituela.

Joe McDonnell IRAkoa zen eta 1981eko uztailaren 8an hil zen, gose greban 61 egun eman ondoren, 30 urte zituela.

Martin Hurson IRAkoa zen, preso irlandarra, eta 1981eko uztailaren 13an hil zen, gose greban 46 eman ondoren, 24 urte zituela.

Inork ez zuen uste Martinek heriotzaren hatsa horren azkar nozituko zuenik, gose greban 46 egun eginak zituenean hil baitzen, baina Martinek ere Irlandarekiko zerga ordaindu zuen, britainiarrek herrialde honi aspaldian ezarri ziotena, odolez, malkoz eta oinazez ordaintzen dena.

Kevin Lynch INLAkoa zen, INLAko borrokalaria, eta 1981eko abuztuaren 1ean hil zen, gose greban 71 egun eman ondoren, 25 urte zituela.

Kieran Doherty IRAkoa zen eta 1981eko abuztuaren 2an hil zen, gose greban 73 egun eman ondoren, 25 urte zituela.

Thomas McElwee IRAko borrokalaria zen eta 1981eko abuztuaren 8an hil zen, gose greban 62 egun eman ondoren, 23 urte zituela.

Azkena Michael Devine izan zen, INLAko borrokalaria, 1981eko abuztuaren 20an hil zena, gose greban 60 egun eman ondoren, 27 urte zituela.

27 urte Bobby-k, 25 urte Francis-ek, 24 urte Raymond-ek, 24 urte Patsy-k, 30 urte Joe-k, 24 urte Martin-ek, 25 urte Kevin-ek, 25 urte Kieran-ek, 23 urte Thomas-ek eta 27 urte Michael-ek.

Jadanik 25 urte iragan dira: gazteak ziren, irlandarrak ziren, preso politikoak ziren, senideak zituzten, adiskideak zituzten, ametsak zituzten, bizirik irauteko gogoa zuten, baina gizaki aske gisa bizi nahi zuten Irlandan eta borrokarik latzenari lotu zitzaizkion.

25 urte iragan dira gazte hauek Irlandaren askatasunaren alde azken hatsa eman zutenetik, baina borrokalari zintzo hauen oroimenak bizirik dirau gogoan dituzten guztien bihotzean bizirik dirautelako.

Britainiarren uztarpean dauden Irlandako sei konderrietan sortu ziren eta, botere britainiarrak erabakitakoaren arabera, beraiek "britainiarrak" ziren, Belfast eta Derryko "britainiarrak". Hamar gazte hauek azkar ulertu zuten beraiek irlandarrak zirela, ez besterik, eta britainiarrak soberan zeudela Irlandan, 800 urte bolada luzeegia baita zurea ez den lurralde batean jaun eta jabe ibiltzeko, bertakoen eskubideak egunero urratuz, eta horrexegatik borrokari lotu zitzaizkion.

Beraien herrialdean arrotzen gisa bizitzera behartuk ikusi zuten beraien burua. Britainiarren bazterkeria eta arrazakeria pairatu zuten 1921az geroztik Irlandako iparraldeko sei konderrietan botere britainiarrak ezarritako apartheid-aren ondorioz (irlandarrentzat eskubiderik ez), baina Irlandan aske bizitzeko borrokatu beharra zegoela ohartu ziren gazte asko zirela. Eta bizitza eman zuten borroka horretan.

Baina borroka latz hau ez zen antzua izan.

Presoek 1981eko urrian gose greba bukatu zuten, ustez helburuak lortu gabe, baina irlandar preso politikoek estatutu politikoa lortu zuten, nahiz eta britainiarrek halakorik lortu denik ofizialki inoiz ere onartu ez duten. Baina britainiarrek amore eman zuten.

Honez gain, hamar gazteek 1981ean buruturiko borroka gogoangarriak irlandar mugimendu errepublikarraren suspertzea ekarri zuen. Borroka

ez zen alferrikakoa izan, gazte hauek utzitako hutsunea beste hainbat gaztek bete baitzuten, ederki bete ere, borrokan aurrera egiteko beti prest, eta horren ondorioz Irlanda bere buruaren jabe izateko zorian dago, askatasuna gero eta hurbilago senti baitaiteke.

*Seo dhíbh a chairde, duan óglaígh*
*Cathréimeach, bríombar, ceolmhar,*
*Ar dtinte cnamh go buacach táid*
*S an spéir go mín réaltogach.*
*Is fonambar faobhrach sinn chun gleo*
*S go tinnmhar glé roim tíoch don ló,*
*faoi chiúnas caomh na hoíche ar seol*
*seo libh, canaíg amhrán na bhfiann*

***(Irlandako nazio ereserkia)***

Irlandako gudariak gara,
borroka orotan egiteko beti prest
gauean baturik
zeru izartsuaren azpian.
Eta Erín-en egunsentiaren zain gaude,
askatasuna ekarriko baitigu.

## Biktimak

Garai hauetan asko mintzatzen da biktimei buruz, batzuk biktimak direla, besteak borreroak direla, eta abar, baina zer da biktima izatea? Zapaltzaileak ere biktimak izan daitezke?

Ipar Irlandan hildako soldadu britainiarrak Irlandako herritarrek beren burua defendatzeko zuten eskubidearen "biktimak" izan dira.

Frantzian 1940-1944 urteen arteko tartean hildako soldadu alemaniarrak Frantziako herritarrek beren burua defendatzeko zuten eskubidearen "biktimak" ziren.

Vietnam-en hildako estatubatuarrak bertako herritarrek beren lurraldea defendatzeko zuten eskubidearen "biktimak" izan ziren.

Aljerian 1954-1962 urteen arteko tartean hildako soldadu frantziarrak aljeriarrek beren herrialdea defendatzeko zuten eskubidearen "biktimak" izan ziren, eta aipamen hau are mingarriagoa zaigu euskaldunoi, gerla hartan euskaldunak ere hil zirelako, Frantziak Aljerian bere alde borrokatzera behartu baitzituen, euskaldunoi ezertxo ere galdu ez zitzaigun gatazka hartan. Aljeriako gerla Frantziaren arazoa zen, eta ez euskal jendearena. Gainera, aljeriarrek arrazoi osoa zuten eta beren borroka guztiz bidezkoa zen, beraien herrialdea defendatzen ari zirelako zapaltzaileen aurka.

Palestinan hildako soldadu israeldarrak palestinarrek beren lurraldea defendatzeko duten eskubidearen "biktimak" dira.

Kurdistanen hildako soldadu turkiarrak kurduek beren burua defendatzeko duten eskubidearen "biktimak" izan dira.

Txetxenian hildako soldadu errusiarrak txetxeniarrek beren lurraldea defendatzeko duten eskubidearen "biktimak" dira.

Zapaltzaileak harro asko sartzen dira besteen herrialdeetan eta armen indarrez beraien legea ezartzen dute, bertakoen eskubideak zapalduz, baina zapalduek erasoari erantzuten diotenean, orduan zapaltzaileek zapaltzaile izateari uzten omen diote "biktimak" bihurtzeko. Eta Euskal Herrian ere munduko beste hainbat tokitan bezalaxe gertatzen da. Gure hizkuntza zapaldu dute, gure kultura zapaldu dute, euskaldunoi geure geroaz erabakitzeko eskubidea ukatu digute, Euskal Herria denik ere ukatzen dute, euskaldunoi espainiar edo frantziar izatea beste aukerarik ez digute onartzen…Baina euskal jendeak kanpotik etorritako zapaltzaileek ezarritako egoera honen aurka borroka egiten badu, orduan zapaltzaileak "biktimak" bihurtzen dira.

Dena den, kanpoko begirale batek Euskal Herrian gertatzen dena aztertuko balu, arazorik gabe ondorioztatuko luke biktima bakarra Euskal Herria dela.

## Neska-lagunak eta emazteak

Euskal preso politikoentzat sendiak zinez garrantzitsuak dira, beraiek baitira presoei beharrezko sostengua ematen dietenak, espetxeraturik dituzten senideak sekulan ere bakarrik utziko ez dituztelako, baina neska-mutil lagunen edo senar-emazteen eginkizuna biziki azpimarratu behar da, beraiek funtsezkoak baitira askotan.

Gizonezko presoen kopurua emakumezkoena baino handiagoa da, eta honexegatik errazago da neska-lagunak (edo emazteak) aurkitzea mutil-lagunak (edo senarrak) baino, baina bai batzuek eta bai besteek begirune osoa merezi dute.

Neska-lagunak (edo emazteak) biziki garrantzitsuak dira euskal presoentzat, hartua duten ardura handia baita. Maite dutena ikustera joateko bidaia luzeak egin behar dituzte, espetxera sartzeko Euskal Herria zinez gorrotatzen duten kartzelariek jartzen dizkieten oztopoak eta eragozpenak gainditu behar dituzte, kartzelarien harrokeria askotan jasan behar dute eta etxean daudenean urruti espetxeratu duten maitearen hutsunea sentitzen dute.

Ez da, ez, batere kontu erraza euskal preso politiko baten neska-laguna edo emaztea izatea, eta egoera gogor horri urtetan eustea. Hau bai dela militantziarik gogorrena, baina zenbaitetan jendea honetaz ohartzen ez dela pentsa liteke. Senide bat espetxean izatea militantzia gogorra da eta Euskal Herrian jendeak hau ongi baino hobeki ulertu beharko luke, zenbaitetan ez baita auzi hau behar bezain ongi ulertzen. Giltzapean dagoena kanpoan dagoen neska-laguna edo emaztearen bizitzaren ardatza bihurtzen da, eta, harremanari eusteko oztopo ugari gainditu behar direla eta, indar berezia izan behar da. Eta ez da beti erraza izaten.

Neska-lagunak edo emazteak lan egin behar du, etxeko lanak egin behar ditu, mutil-laguna edo senarra ikustera espetxera joan behar du, seme-alabak izatekotan seme-alabez arduratu behar du, eta abar. Egoera honi eusteko indar handia behar da, maitasunak emandako indar berezia hain zuzen ere.

Haurren bat izatekotan neska-lagunak edo emazteak ama eta aitarena egin behar du aldi berean, etxetik urruti espetxeratua dagoenaren hutsunea bete behar baitu hala edo hola, eta honek areagotu egiten du neska-laguna edo emaztearen ardura, haurraren heziketan sortzen diren arazoei buru emateko bakarrik dagoelako.

Haur txikiari azaldu behar diote aitatxo zergatik ez dagoen etxean, zergatik dagoen espetxean, zergatik ezin duten beraiek bizitza normal bat egin, aitatxo ikusteko zergatik egin behar dituzten bidaia luze eta nekagarriak…

Neska-lagunak edo emazteak haurrari azaldu behar dio aitatxo ez dela gaiztoa, ez dela gaizkilea, eta aitatxori buruz batzuetan entzungo dituenak ez direla egiazkoak. Neska-lagunak edo emazteak haurrari azaldu behar dio aitatxok borroka egin zuela Euskal Herriaren eskubideen alde, eta honexegatik eraman zutela preso, euskaldunentzat etorkizun hobea nahi zuelako.

Neska-laguna edo emaztea bakarrik sentitzen denean edo arazoren bat sortzen zaionean, ez du maite duena ondoan bere aholkua izateko edo bere laguntza hartzeko, eta bakardadeari edo arazoari bakarrik eta ahal duen moduan aurre egin behar dio.

Gogorra da etxean mutil lagunaren hutsunea sentitzea. Preso baten neska-laguna edo emaztea ezin da mendira joan bere mutil-laguna edo senarrarekin, ezin da hondartzara joan berarekin, ezin da oporretan joan berarekin, ezin ditu herriko jaiak berarekin gozatu, ezin ditu berarekin bizi beste bikoteek bizi dituzten une goxo eta gogoangarriak, ezin dio mutilari edo senarrari kontatu zer moduzkoa suertatu zaion eguna, ezin dio mutilari edo senarrari lanean izandako gorabeheren berririk eman, eta abar.

Gauak luzeak dira maite duzuna ondoan ez duzunean.

Mutil-laguna edo senarrarengana iristeko bidaia luze eta nekagarriak burutu behar dira, kartzelariek jarritako arazo eta eragozpen guztiak gainditu behar dira, baina neska-laguna edo emaztea maite duenaren ondoan dagoenean, mutil-laguna edo senarraren muxu bat, besarkada bat eta fereka bat nahikoak dira mutila edo senarrarengana iristeko pairaturiko oztopo eta arazo guztiak giltzapean jartzeko, keinu hauek guztiak garrantzitsuak baitira batere normala ez den egoera hau bizi dutenentzat.

Neska-lagunak edo emazteak maite duen horri aurrez aurre "Maite Zaitut" esateko bidaia luze eta gogorrak egin behar ditu, eta oztopo mordo galanta gainditu, baina bikote berezi hau osatzen dutenei (kanpokoari zein barrukoari) elkarrekin egoteko unea iristen zaienean, une horiek indar handikoak eta bereziak dira oso, une kuttunak baitira, zenbait orduz beraiek bikote normala ez direla ahazten laguntzen dietenak. Urteak aurrera doaz eta neska-lagunak edo emazteak espetxean duen mutil-laguna edo senarra ikusteko bidaiak egiten jarraitzen du. Mutil-laguna edo senarra giltzapetik noiz aterako den ez jakitea gogorra da, mingarria, baina neska-lagunak edo emazteak hortxe jarraitzen du, bere sostengua barruan dagoenarentzat funtsezkoa dela ederki dakielako. Eta mutil-lagunak edo senarrak ere badaki neska-laguna edo emaztea ondoan izango duela beti, berak behar duen edozer egiteko hortxe izango baita.

Euskal preso politikoen neska-lagunak eta emazteak emakume aparta dira, bereziak, behin eta berriz frogatzen ari baitira izugarrizko indar berezia duten Euskal Herriko emakumeak direla. Eta gu guztion begirunea ongi asko merezia dutela. .

## Urdinez jantziriko gizon horiek

Espetxean kartzelariak harrokeriaz jokatzen du beti, eta bere gogoa lege bihurtzen da. Presoek kartzelariaren nahia zintzo asko bete behar dute, izugarrizko menpekotasuna agertuz, kartzelariak ez baitu bestelako jarrerarik onartzen. Giltzapean kartzelariak agintzen du eta kitto!!

Gehienetan legeak ez du balio espetxe barruan, legea kartzelariaren gehiegikeriek ezarritakoa besterik ez baita. Erabateko zigorgabetasuna dutela ederki dakite eta edozein bidegabekeria egiteko beti prest daude, lanean mozkortzea dela, presoak iraintzea, umiliatzea eta egurtzea direla, eta abar.

Baina nortzuk dira kartzelari izatea erabakitzen dutenak?

Pedro, Juan, Antonio, Pablo, Jorge…Hauxe zen beraien izena kartzelari bihurtu aurretik, baina espetxean "Don Pedro", "Don Juan", "Don Antonio", "Don Pablo", eta abar bihurtzen dira. Presoek honela deitzen dietenean, biziki garrantzitsuak sentitzen dira.

"Ogibide" hau hautatzen duten batzuk nortasunik gabeko gizakiak dira, bizitzan ezertxo ere sekulan izan ez direnak, ezertarako balio ez dutenak eta umetatik besteen erdeinua pairatu behar izan dutenak.

Beste batzuk, aldiz, harroak dira, gaiztoak eta zitalak, besteak menpe hartuta dauzkatela sentitzea maite dutenak, eta zaintzapean dauzkaten presoak iraintzea, umiliatzea eta egurtzea izugarri atsegin zaie.

Badira alfer hutsak direnak ere, "ogibide" honetan lanik ez egiteko aukera aparta ikusi zutenak, maisu izan beharrean kartzelari izatea erabaki zuen horren kasuan bezala, adiskide batek espetxeko "ogibidea" gomendatu baitzion, lan gutxi egin behar zelako eta soldata ederra irabazten zelako. Hau entzun ondoren (lan gutxi eta diru asko), maisu izateko asmoa baztertu zuen erabat. Aholkua eman zion adiskideak ederki zekien zertaz ari zen, berak ere giltzapeko "ogibidea" aukeratuta baitzuen aspaldian.

Kartzelari bihurtu direnak espetxean zinez garrantzitsuak sentitzen dira, agintea (bidegabekeria, hobeki esanik) beraiek baitute. Nortasunik gabekoa garrantzitsua sentitzen da espetxean, bera nonbait dela sentiarazten dion "ogibide" egokia aurkitu duelako.

Gainontzekoak menpe hartuta izatea maite dutenak ere pozik sentitzen dira, preso guztiak haien menpe dituztelako, eta honek biziki garrantzitsuak direla sentiarazten die, espetxean boteretsuak direlako.

Alferrak ere pozik dabiltza, "ogibide" honek batere lanik ez egiteko aukera bikaina eskaintzen dielako.

Kartzelari asko eta asko arrazistak dira, afrikarrak, arabiarrak eta hego amerikarrak guztiz gorrotatzen baitituzte. Dena den, ustelkeria kontuetan ere oso trebeak dira eta, diru truke, presoei alkohola, janaria, eskuko telefonoak eta espetxean legez kanpokoak diren bestelako objektuak ekartzen dizkiete. Kartzelariak preso dirudunen adiskide izaten saiatzen dira behin eta berriz, eta diru truke preso horiek nahi duten guztia ekartzen dute.

Esan bezala, kartzelari asko arrazistak dira, baina diru truke egindako "zerbitzu berezi hauek" burutzen dituztenean, ez zaie axola ordaintzen dien presoaren eskua zein koloretakoa den. Arrazistak dira, bai, baina etekin ziurta diezaiekeenaren azalaren koloreari ez diote erreparatzen eta preso horien morroi hutsak bihurtzen dira.

Madrileko espetxe batean, kartzelari batek zeregin honetan ari zela harrapatu zuten espetxeko arduradunek, eta sei hilabetez lanik eta soldatarik gabe zigortu zuten. Kartzelari honek bera bezain ustelak ziren beste kartzelariek bere alde zerbait egingo zutela uste zuen, baina ez zen horrela gertatu eta bakarrik utzi zuten.

Kartzelari honek berebiziko gozamen lortzen zuen presoak zirikatzen eta moduluko giroa beharrik gabe berotzen. Bizkarra zainduta zuela ederki

zekien, adiskide mina zuen zerbitzu buru batek babesten zuelako, bera babesteari utzi zion arte.

Kartzelari ustela harrapatu zutenean, zerbitzu buruak ez zuen ezertxo ere egin bere alde. Hasieran, kartzelari ustelak ez zuen ulertzen bere lagun minaren jarrera, baina laster ohartu zen zerbitzu buruak ez zuela nahi berarekin lotu zezaten. Eta adiskideak omen zituen beste kartzelariak, bera bezain ustelak zirenak, harengandik urruntzen hasiak zirela ohartu zen, hauei ere ez baitzitzaien komeni "in fraganti" harrapatutako kartzelariarekin lotu zitzaten.

Hortaz, hautsiezina dirudien kartzelarien arteko "adiskidetasun" handia desagertu egiten da honelakoetan.

Azkenean, sei hilabetez zigortutako kartzelaria zigorra bete ondoren "lanera" itzuli zenean, zereginik itsusienak eta txarrenak eman zizkioten, inortxok ere nahi ez zituenak eta adiskide min izandakoak aurpegira ere ez zioten begiratzen, nahiz eta gehienak bera bezain ustelak ziren, baina kartzelari honek zorte txarra izan zuen, bera harrapatu baitzuten, eta besteak, aldiz, ez.

Kartzelari gehienak espainiar peto-petoak dira, munduan Espainia bezalakorik ez baitago (kartzelariek ere "a por ellos, oe" kantatzen zuten 2006ko udan, Espainiak munduko futbol txapelketa irabazi behar zuela zalantzarik ez zegoelako), eta euskal preso politikoen aurkako "Espainiako gizartearen bidezko mendekua" gauzatzeko tresna sentitzen dira. Horrexegatik euskal preso politikoen bizimodua izugarri gogortzen dute. Euskal preso polítiko batzuek Espainiako espetxeetan beren buruaz beste egin dutenean, kartzelariek ez dute beraien poza ezkutatu: "Hiltzaile madarikatu hauek ez dute bizimodu gozorik izan behar giltzapean, ez horixe".

Kartzelari askok txapelokerra izateko ausardiarik ez zuten, euskaldun "gaiztoen" aurka borrokatzera Euskal Herrira bidal litzaketelako, eta hori zinez arriskutsua izan liteke. Askoz errazagoa da Espainiaren batasuna

hautsi nahi dutenen aurka Euskal Herritik urrun dauden espetxeetatik borrokatzea, euskal abertzaleen eskubideak zigorgabetasun osoaz urratuz, Hau da hau jende ausarta!

Giltzapean dauden euskal abertzaleak Euskal Herriaren burujabetasunaren alde borroka egiten dute, eta hau ezin da zigorrik gabe utzi. Eta horretarako daude kartzelari "zintzo eta ausartak", Espainiaren alde atzo, gaur eta bihar egiteko.

2004ko martxoaren 11n preso arruntak euskal preso politikoen aurka xaxatzen aritu ziren, seguru baitzeuden Madrileko erasoak euskal jendeak burutuak zirela. Eta gaur egun ere, ez dute euskaldunen parte hartzea baztertzen, hauek ere egia osoa jakin nahi dutelako (¡Queremos la verdad!).

Kartzelariek euskal preso politikoekin agertzen duten jokabidea hobeki ulertzeko, biziki adierazgarria da kartzelari batek euskal preso politiko bati aspaldian esan ziona, honek agerian usten baitu kartzelarien benetako izaera: "Frantzian GAL ari duk; Espainian, kanpoan, guardia zibila ari duk; eta hemen, barruan, gu ari gaituk". Biziki adierazgarria da. Ulertu nahi duenak uler dezala.



**Oscar Barreras Diaz**
1974
Bilbo

1997. urtean atxilotu eta espetxeratua.



C.P. Castelló
Carretera de Alcore, Km. 10
12006 Castelló

## Arsenio Loperena, il cretino

- Nome?
- Arsenio.
- Cognome?
- Loperena.
- Nacionalitá?

Puntualki ihardesten zien poliziaren galderei, bai, baina haren gogoetak beste nonbait zeutzan. Arseniok erdibanaturik zuen burua memento horretan. Lotan baleak nola, bada halaxe; garunaren erdia ametsetan goxo, beste erdia adi arnasteaz ez ahanzteko. Baleek zerekin duten amesten jakiterik ez dago, auskalo; Arsenio ordea zerekin amestu badakigu: bere motorrarekin. Atearen gainaldean "Questura" izenburua agertu eraikinera burdinetan ekarri zutenetik, 250 zentimetro kubikoko Yamaha zarpail, builatsu eta ehun kilometroro arazo berriren bat asmatzen zuen motorraren akordua zeukan buruan. Baleentzat apika, pertsona askorentzat lez, askatasun preziatuaren ikurra itsaso garbi, nare eta zabalaren irudia da. Askatasunaren idei eta sentipena bere baitan laburbiltzen duen ikurra, hura. Holako ikur asko egongo bide dira, askatasun ametsak adina beharbada. Ideia edo sentipena baino, Arseniorentzat askatasuna egoera bat da, nahi duzunera nahi duzunean joateko ahalbidetzen zaituen egoera, horixe askatasuna. Eta egoera horren ikurra, bere motorra.

Eta motorrarena zen polizia-etxean sartu zuten unetik buruan zeukan irudia, poliziari jaramonik ez zegion garuneko zatian hain zuzen. Atxilo hartu zutenean ez baina.

Ordu erdi lehenago urduriegi, kezkatuegi zegoen ezelako ametsetan jarduteko, garuneko alde biak erne behar zituela. Poliziek atxilo hartzean burdinak lasai asko jasan zituen, baita kontent pixka bat ere. Geroago tamalgarria iritziko bazion ere polizien atzaparretan erori zenean salbu ikusi zuen bere burua. Lotsagarria.

Gaueko bederatzietan puntu-puntuan heldu zen hotelera. Albo batera eraikinak zuen zabaltzan jendetza ageri eta musika aditzen zen. Arsenio sarrerantz zuzendu eta han jende ugari ere; batzuk irten besteak sartu, eta apur zenbaitzuk han bertan geratu, alai itxurazko hitz-aspertuan. Barruan ere mugimendu handia zegoen, baina giroa bestelakoa zen, pausatuagoa edo. Kristal gordineko ateek iskanbila kanpoan gelditzen zuten eta holako lekuetan entzuten den elkarrizketen etengabeko zurrumurrua aditzen zen soilik.

Harrera-lekura hurbildu eta tabernaz galdetu zuen, logeletako giltzen ilarei begirada azkarra emanaz. Tabernara joan eta hura ere jendez mukuru zegoen. Norbaiten peskizen antzera ibili zen tarte batez, hutsaren peskizan berez, disimuluan harik eta eskaileretarantz abiatzen zen mozkorti talde batekin nahasten lortu zuen arte.

Mozkortiak lehenengo solairuan geratu ziren, denak gela berberera sartu zirela. Aupa! Hamar edo hamabi pertsona, ederra jaia. Taldeko emakumezko batek zerbait esan zion aitzurrak arras zaildu italieraz, berak ea haiekin sartuko ez zen galdetzen ziola ulertu eta zalantzan egon zen une batez. Baina bera besteetara etorria zen. Desenkusatu eta eskaileretan gora jarraitu zuen.

Hoteleko bisitari ia denak italiarrak ziren, hori ere nabaria zuen. Leku paregabea zen herrixka zegoenekoa, bidai agentzietako iragarkietan agertzen diren horietakoa, eta hizkuntz arrotzaren bat edo beste espero izan zuen aditzea. Baina ez, agidanez herrixka italiar agentzietako iragarkietan baino ez zen agertzen.

Berak aukeratu solairura heldu zen, seigarrenera. Pisu hori harrera-lekuan zintzilik giltza gehien zeukana zen, horrexegatik aukeratu. Beheko zonaldea ikusirik, hoteleko gela gehienak beteta egongo zirela pentsatzekoa zen. Orduan, edo gela horiek logikak iragarri kontra okupatu gabe zeuden edo hutsik hartzaileak kanpoan zeutzalako, beheko jaian akaso. 609. eta 615. arteko gela guztietako giltzak zintzilik zeuden taulan. Sei gela hutsik elkarren parean…paregabea! Eskaileretatik hurbilen zegoena 615.

zen eta harantz abiatu. Korridoreko albo bietara zelatatu ondoren, belarria atera hurbildu zuen. Barruan ez zen ezer aditzen. Badaezpada ere, zuhurra baitzen Arsenio, bizitzaren makilakadek irakatsi zuhurtzia berarena, atean jo zuen. Ezustean txabusinaz jantzirik bere burusoil distiratsuaren gainean galdera ikurra zeraman gizona azaldu zitzaion. Arsenio zur eta lur geratu zen lipar batez. Segituan planta eginez honela galdetu zuen:

- Hey, where is Jimmy?

Eta ezezagunak, jasanbera keinuaz lagundurik bisaia erlaxatzen zitzaiola:

- O, mi dispiace, penso che lai me torto.

Okertu egin zela… Okertu! Bai, eta burusoilak ez zekien ongi zer punturaino okertu ere.

Eta berak, geroxeago, solasari amaiera emateko edo, honela gehitu zuen italieraz ez dakiela agerian utzi nahi duenaren italierazko doinuarekin, desenkusa gisa, desenkusa bikoitza apika:

- Mi perdoni!

"Kaka!", jaulki zuen bere kautan gizonak irriño axolagabe batekin atea itxi ostean. Alboko gelara joan zen, zuzen, bere buruaren kontra irain biraoka hasteko astirik hartu gabe. Segundo batzuk itxaron eta atean jo zuen. Tartetxo igaro eta inor agertu ez. Tak-tak atzera jo. Isilunea. Eta berriz irriñoa Arsenioren begietan. Bisaia serio ordea, aurreko akatsa gogoan. Erremintak atera eta di-da barrura. Hoteletako sarrailak ez ziren arazo Arsenioarentzat, Alemaniakoak salbu, horiek bai zerrapoak!

Gela ilunpean zegoen, isilpean. Han ez zegoen bera ez zen inor. Tamalez azterketa arin bat nahikoa izan zen okupatu gabea zela jabetzeko.

- Kaka zaharra, bitik huts!

Balkoira irten zen. Gela bakoitzak balkoi txikia zuen, albokoetatik hurbil oso, ukitzen ia. 615.era behatu zuen. Ez zen argirik ikusten, oherako bidean harrapatu omen zuen gizona. Behera begiratu eta itsasoa besterik ez zuen ikusi, itsaso bare eta iluna labarrak amoroski ferekatzen, han goian bertan eraikita baitzegoen hotela. Ezinezkoa zen inork kanpotik bera ikustea eta lasai asko 613. gelako balkoira jauzi egin zuen. Logela ilunpean eta hutsik zegoen, baina balkoitik hurbil zen bainugelako atearen azpialdetik argia ikus zitekeen. Memento horrexetan hots bat aditu zuen barruan, norbait dutxa txorrota irekitzen ari zen.

- Izan ere! Hirutik huts?

Eta bat-batean ikusi zuen, han bertan, ohe gainean itzalen artean: egundoko maleta.

Bi aldiz pentsatu ez eta salto batez barrura egin zuen. Arin eta isil, katuaren antzeko. Arsenio tupustean profesionalaren paperean sartuta, txorrota aditzeari utzi gabe, maleta zabaldu eta begirada kolpe batez han barruan zer topa zezakeen saiatu zen asmatzen. Agertzen zen lehenengoa jantziak ziren. Emakumezkoak eta gizonezkoak alde banatan. Bikotea zen. Tira, biak dutxan bazeuden astirik soberan bazegoen. Gizonezko alkandora bildua jaso eta aztertzeari ekin zion: taxu dotorea, oihal ederra: alkandora garestia, neurrira egiten den horietakoa. Adurrari eutsi behar izan zion, hezur baten aztarna kausitu zakur bat lez ahoan kilika gozagarria sentitzen hasia baitzen. Pagotxak behar zuen maleta horren barruan! Barrunbeak aztertzeko alkandora alboratzean, hau haren eskuetan zabaldu eta lekuan iltzaturik geratu zen Arsenio. Hura alkandora! Kaskoan lotuta jauregi zahar bateko mamuarena egiteko balio liokeena. Bere begien parean jasota mahukek moketa ukitzen zuten kasik. Segundo batez bainugelako ur zorrotadan pentsatu zuen, bero alkandora behatu eta azkenekoz horren barnean sartzen omen zen gizona saiatu zen irudikatzen. Lehenagoko aho kilika gozagarri haren bizkar-hezurra zeharkatu zuen hotzikara izugarria bilakatu zen mementoan. Hasieran uste baino askoz arinago ibili beharko zuen alkandorako jabea ezagutzeko ezelako desirarik ez zuen eta.

Ustekabean, korridoreko atea ireki zen eta kanpoko argitasunak bete zuen gela. Emakumezko bat agertu zen bertan. Emakume txiki eta mehea, akaso zentimetro batzuk irabazteko orrazkera altu eta xelebrea zeramana. Hasieran han geratu zen, atearen orpoan giltza eskuan eta ulertu ezinik. Ateko zenbakiari eta jarraian Arseniori begiratzen zien, aldika. Halako batean honek eskuan hedaturik zeukan alkandoran erreparatu eta orduan bai, orduan hasi zen garrasika. Danbateko batez atea itxi eta ihesari ekin zion, haren garrasiak korridorean aurrera ahulduz entzuten zituela Arseniok. Bere begiek iluntasunari ostera ohitzeko astirik izan gabe, beste argitasun berriak bete zuen gela. Burua biratu eta han ikusi zuen alkandora erraldoiko alimaleko jabea. Kolosala. Bainugelatik atera ahal izateko bizkarra makurtu behar izan zuen. Bere atzetik txorrotaren hotsa aditzen zen oraindik, lotsariak toaila txiki batekin estaltzeko besterik ez zuen denborarik izan. Gorputz bustiari distira zerion, edozein umetxoaren amesgaizto latzenetako munstro ikaragarria zirudien. Ilegorri eta azal txuri-txuriko sumo borrokalari bat bezalaxe. Zeharka ikusi zuenean Arsenioren lehenengo erreakzioa, ikarak bultzaturik, ohera igotzea izan zen, burkoaren aldean paretaren kontra jarria. Erraldoia oinkada batez oheraino hurreratu zen, oin aldean geratuz.

Han zeuden biak; erraldoiak eraso ez, lehenbiziko kolpean huts egitekotan Arseniok ihes egingo zitzaiola bazekielako; Arseniok ihes egiten saiatuz gero erraldoiak mugimendu txikiaz bai korridereko ihesbidea bai balkoiarena itxi ziezaiokeela zekien bezalaxe. Bata alde batera mugitzen bazen, bestea beste horrenbeste; batek zango batean nerbio-tika jasaten bazuen, besteak ere. Ispilu desitxuragile baten aurreko dantza bitxi bat lez. Eta horrela ibili ziren tarte amaigabeaz, zentzugabeko jolasean, erraldoiak zenbat eta haserreago, Arsenio gero eta izutuago.

Bere onerako, polizia minutu gutxi batzuetan agertu zen eta erraldoia otzandu ostean, atxilo eraman zuten.

Emakumearen garrasiek hotel osoa jarri zuten ernai. Beheko igogailutik irtetean, lehenengo zurrumurru etengabea desagertua zen, baita kanpo-

ko musika eta iskanbila ere, denak isil eta bereri adi, haien begirada gogor eta isilune sakonaren bidez gaitzespena eta mespretxua eskaintzen ziotela. Gutxi axola zitzaion baina Arseniori jendeak berari buruz pentsatu edo esango zuena.

Arseniok nomada garaikidetzat zeukan bere burua. Atzo han, gaur hemen eta bihar auskalo non. Motorra, motxila eta bidean aurrera. Presarik gabe, aldez aurretik ezarritako norabiderik gabe; errepidea edo, hobe esanda, motor kaxkarrak eramango zueneraino.

Hiru egun zeramatzan itsasertzeko herrixkan eta ikusia zuen hotela, lar ikusia. Inguru horietako hotel bakarra, handia. Handiegia inguruetarako, etxe txuri apaleko herrixkako postal argazkiak zakartzen zuena eta, halarik ere, postal guztietan agertzen zena. Irain bat zen Arsenioren begietan, zirikatzen zion erronka haren gogoetan.

Italian aste batzuk baizik ez zeramatzan. Barnealdean negozio on pare bat burutu eta kostaldera jotzea deliberatu zuen. Holako batean motorra gelditu zitzaion, ohi lez. Lokan jarri eta aldapan behera egin zuen herrixka honetara ailegatu arte. Motorra konpontzeari ekin eta geroago osteratxoa eman zuen herritik. Gustatu zitzaion lekua, biziki gustatu. Haren kale estuak, portu txikiko giro alaia, itsasoaren usaina…bere umezaroko akorduak ekarri zizkion herrixkak eta egun batzuk bertan geratzea erabaki zuen. Baina han zegoen hotela, hotel handitzar hura, herriko xarma eta bere gaztaroko oroitzapenen sekuentzia aldiro puskatzen zuena. Gustu onerako iraina, begietarako mina, probokazio hutsa zen hotela. Kaia, taberna, plaza eta ostatuko logelatik, edozein lekutik ikus zitekeen eraikin arraio hura herriko goialdean paratua, aitzinean herriak kontrolpean ukaiteko gazteluak paratzen zituzten bezala. Jasanezina. Benaz gogaiturik handik alde egitea erabaki zuen, eraikin horrek beharturik; baina alde egin aurretik mendekua hartuko zuen. Arropa kuriosoenak jantzi eta hara joan zen, mendeku gose.

Eta orain aldiz polizia-etxean zegoen. Lasaiturik poliziek erraldoiaren besarkadatik libratu zutelako eta polizien eskuetan erortzean lasai eta salbu sentitu behar izanagatik bere buruarekin haserre. Galderei auto-

matikoki ihardesten zien, italieraz apur bat bai baitzekien, ez poliziak haren bizkarrera egiten ari ziren txantxak eta algarak ulertzeko modukoa, baina bai horrelako galderei erantzuteko nahikoa.

Halako batean erraldoia eta bere lagun nanoa polizia-etxean agertu ziren, salaketa gauzatzera. Jantzirik are erraldoiago zirudien. Arsenio ikustean haserretu zen atzera eta biraoka zein mehatxuka hasi zitzaion. Poliziek, berriro Arsenioren salbamendura, tartean jarri eta gizona baretzeko Arsenio hortik lekutzea deliberatu zuten. Burdinak ipinita, gela txiki batera eraman eta han gorde zuten behin-behinean.

Gela karratua zen, hitsa, altzari eta dekorazio bakartzat plastikozko aulki bi zituena. Pareta baten gainaldean leiho txikia zegoen, kristala zabalik eta kanpoko aldean sare-maila herdoilduaz itxita. Arsenioari ezinezkoa iruditu zitzaion, sinestezina; dena dela, aulki bat leiho azpira hurbildu, igo eta bi ukabilekin batera takateko bat jo zuen. Bere harridurarako, sare-maila askatu zen, izkina batetik zintzilik geratuz. Jauzi batez kanpora egin zuen. Lurra hartzean jasan zuen minari jaramonik egin gabe korrika aldendu zen, itzalgaizka. Motorra ezkutaturik utzia zuen tokira ailegatu, han geratzen zitzaizkion erremintekin burdinak askatu eta herritik ospa egin zuen.

Ordu t´erdi beranduago ehun bat kilometrora zegoen beste herrira heldu zen, haraino eraman baitzuen makina traketsak azkenaurreko arnasa eman aurretik. Herriko sarreran itxita zegoen gasolindegiko aparkalekuan motorra geratu eta sasien artean gorde zen lo egiteko. Biharamunean, estreinako argi izpiekin batera itzarri, motorra konpondu eta bere bidea jarraitu baino lehen zegoeneko zabalik ageri gasolindegiko tabernan gosaltzea deliberatu zuen. Sartzean baina, mahi batean eskualde hartako egunkari bat zetzan azala ikusgai. Eta han, bestelako berrien artean honako titularra irakurri ahal izan zuen:

“Il cretino spagnolo si butta dalla finestra della questura”

- Baina ze…? Il cretino…!!!

Titularrak sutan jarri zuen Arsenio. Odola bor-bor, berehala sumindurik zegoen, oso. Onartezina zen hori. Jasanezina! Goseaz, bertan egoteko arrazoiaz eta gainontzeko denaz ahantzirik, tabernatik irtenda motorrera igo eta aurreko gauean heldu zen bidetik egin zuen gibelera.

Motorra zarata ezezaguna sortzen hasi berria zenean, herrixkara heldu zen. Polizia-etxeraino hurbildu eta motorra bere aurrean aparkatu zuen. Atean zegoen polizia ez zen apenas beregan erreparatu. Polizia-etxea oinez inguratu eta leihatila azpiraino ailegatu zen. Jauzi batez barruratu, artez edo moldez sare-maila lekuan berkokatu eta aulkian jesarri zen pazientki.

Hortik zehaztu ezinezko denbora batera polizia bat agertu zen gelan. Arsenio ikustean berehala ezagutu eta ahoa bete hortz geratu zen. Leihoari eta jarraian Arsenioari begiratzen zion, aldika, konprenitu ezinik. Arsenio aulkitik jaso zen pausatuki, lasai asko, poliziarengana patxadatsu hurreratu eta honela esan zion, haren eite bare nasaiarekin bat ez zetorren doinu mindu ozenarekin:

- Il cretino spagnolo?...Io non sono spagnolo!!!

Biharamuneko eguerdian, eguneko kazetak gartzelara ailegatu zirenean Arsenio patioan gora-beherako osterea gelditu eta bezperazkoa baino letra aski handiagoez idatzirik zetorren titularra irakurri ahal izan zuen, bere irriño mozolo ezaguna berragerrarazi ziona:

"Il cretino vasco ritoma in questura dalla finestra".



**Jokin Urain Larrañaga**
1959
Mendaro

1986an atxilotu zuten.



C. P. La Moraleja
34.210 Dueñas
Palencia

**Galduen ostatukoak**
**-Uriberenak-**

-Labirintuak dira trenbideak, eta gu, trenetako bidaiariok, labirintuetako begiraleak gara –esan zion Joxe Txurtxak Uriberi-. Sogileak gara leiho hauetatik. Zuk, etorkizunari begiratzen diozu eserita zauden leku horretatik; geroa nola datorren ikusten duzu. Nik, berriz, iragana nola urruntzen den ikusten dut hemendik.

Barre-aire handiarekin erantzun zion Uribek, "asko gara bidean galduak edo trabatuak" eginez berekiko.

Denbora da Joxe Txurtxaren aztarnen bila zebilela kontalari hau, eta pozgarri zaio haren berri izatea, Galduen Ostatura itzultzeko modua ere badelako. Eta, nor ez dabil itzulera bila!?

"Itzulera, ai itzulera!", egingo luke Joxe Txurtxak kontalari honen burutazioak ezagutuko balitu.

Zaputz kutsu bat erantsi digu harekin aurrez aurre topo egin ez izanak, baina kontalariak aitortzen du bereziki gozo zaiola Uriberen bitartez jakitea Joxe Txurtxaren kontu eta pausoen berri. Egia ezkutatuko genuke dena aitortu ezean, eta egia ezkutatzea, txerrikume jaio berria titirik gabe uztea da, nola bizi ez dakiela.

Uribe entzule zen ordea kontalari baino. Izaera horrek erosoago egiten zion agian trenetako bidaia amaiezin hura.

Tartean tartean, geltoki batean edo bestean jaitsi egiten zen trenbide labirintuari irteeraren bat aurkitu nahian; geltokitik abiatuta ibilaldiak egiten zituen hiri handi edo herri txikietan, eta ostera geltokira itzultzen zen, begirada oinetara erorita, hurrengo trena hartzeko. Burua leihoaren kontra ipiniz eseriko zen han, etorkizunari begiratzeko edo parean esertzen zitzaionaren berriketari armonia egiteko…

Labirintuan barrena zihoan horrela.

Hondoraino lotuta dagoen torlojua ateratzeko jira-bira jakin batzuk behar diren bezalaxe, trenbideen labirintutik behin betiko askatu ahal izateko denborak bere itzuliak osatu behar zituela pentsatzen zuen Uribek, harik eta denboraren itzulietako bat berari zegokion lekuarekin egokitu arte. Esan liteke denborak eta espazioak beregan zuten armonia galdu edo nahastu egin ziotela Uriberi eta, hura berreskuratu arte, geltoki batean edo bestean jaitsiz, hiri handi edo herri txikietan bila ibiliz, ostera trenera igo eta bidaia jarraitzera kondenatua zegoela.

Horrela zihoan Uribe, leihoaren ondoan eserita, abiadura bizian agertzen zitzaion paisaiari begira, guk asma ditzakegun eta imajinatzen ez ditugun burutaziok eginez, bere aurreko aulkian eseri eta Joxe Txurtxa zela esan zionean gizonezko zarpaildu hark. Modu dotore airosoan aurkeztu zen gizonezkoa, buru keinu maiestatikoan makurtuz.

Bekera irribarretsuz erantzun zion Uribek.

Alboko aulkiren batetik begira zegokeen edonork esango zukeen gustura hartu zuela gizonezko heldu berriaren konpainia.

"Alaba izango da", pentsatu zuen beharbada bidaiariren batek; "etxetik bidalitako osaba sobrantea, eskale dabilena", begitandu zitzaion ziur aski norbaiti.

Guk badakigu ordea ez direla bidezkoak irudipen horiek, Joxe Txurtxa ez delako ez Uriberen aita eta ez inork etxetik bidalitako osaba sobrantea. Ez genuke, gainera, horrelako zurrumurrurik haizatu behar. Bestela, bataren ahotan putzu zuloko apotxo karrankari dena, bestearenean laster izan daiteke basatzako apote kurrinkari.

-Leihoa ikusten dut batzutan- esan zion Joxe Txurtxak-. Begiratu eta begiak kliskatzen dizkit, eta isatsa astindu ondoren bidean aurrera abiatzen da, itsuaurrekoa legez.

-Kar kar kar – Uribek.

-Galduen Ostatua atzera laga eta trena hartu nuen, lehoia lehen aldiz agertu zitzaidanean. Hemen nabil ordutik. Ametsetan agertzen zait ordea lehoia, eta ez da erraza ametsetan ikusten diren bideak egun argitan zuzen bereiztea. Itsasoak bizkor ezabatzen du ubera.

"Ez da patua hara eraman edo hona ekartzen gaituena", pentsatu zuen Uribek Joxe Txurtxari begira. "Ez, ez da patua, aukeratzen dugun bidea baizik. Aukerak kendutakoan geratzen zaigun bidea", zehaztu zuen berekiko, treneko bagoi hartara nola iritsi zen gogoratuz. "Urazala urratu duen ubera hori, aurrean joan denak egina da; geurea ez dugu ikusten atzera begiratu arte".

Leihotik paisaia zuriari begira zihoan Uribe, Joxe Txurtxa berriketaldian etena egin eta bere lekutik jaikitzen sumatu zuenean. Larriren batek hartuta, alde batera eta bestera begiratu zuen. Bagoiaren alde bateko ateraino joan zen, baina hura ireki gabe itzuli ostera eta beste aldeko atera abiatu zen, parean igarotzean Uriberi keinu eginez.

"Berehalaxe etorriko naiz", ulertu zion.

Trena makaltzen ari zen. Geratzera zihoan.

Geltokia, trenbidearen inguruak… elurte handiak estalita zegoen guztia. "Agur-Arin", irakurri zuen geltokiko errotulua, eta Joxe Txurta ikusi zuen bagoitik jaitsi eta elur gainean bost-sei pausu urruntzen.

Keratxoaren ondoren berriro abiatu zen trena, eta leihotik ikusi zuen Joxe Txurtxa ez zela ohartu. Hots egin zion…

Berriketariaren falta sumatu zuen Uribek, hainbat alditan legez. "Ezinbestekoa da bide luzea daramanak bakardadea izatea lagunik leialena", kontsolatu nahi izan zuen bere burua. "Zakurra bezain leiala da bakardadea, izaina bezain bizkarroia, borreroa bezain zikoitza".

Barreari ere arnasa jaten dio bakardadeak, eta barrea berezkoa bezain beharrezkoa zuen Uribek. Loreak udan ihintza bezain beharrezkoa.

Bagoiak estutu egiten zuela sentitu zuen; itolarria zekarkiola trenaren triki-traka triki-traka hark ere. Leihotik zetorkion paisaiak ezin zuen baretu.

Behinola Joxe Txurtxa trenera igo zen geltoki hartan jaitsi zen Uribe. Aire hotza sakon arnastu, inguruari begiratzeko geralditxoa egin, eta herriko kaleetara abiatu zen eskuak beroki handiaren sakeletan sartuta.

Kaleetan barrena, Galduen Ostatuko atera iritsi zen. Atearen albo batera, espaloian, Artzubi zegoen salmahai txiki baten atzean.

Uribek ez zekien, noski, gizonezko hura Artzubi zenik, baina laster jakingo du. Ez gaitu harritu behar historia bateko hainbat pertsonaiak elkarren berri aurre aurrez ez jakiteak. Oraingoan geuk esango diogu belarrira, inor ohartzeke: "Hori Artzubi da".

Txima nahasiak eta belaunetatik behera luzatzen zitzaion gabardina zeuzkan Artzubik. Ondoan, esku batekin haren gabardina barrenari heldu eta kokoriko jarrita, gizonezko beltxaran bat zegoen.

Gizonezko biei aurrena eta salmahai txikiari ondoren begiratu zien Uribek, harrituta seguru asko.

-Behar al dituzu? –galdetu zion Artzubik salmahai gaineko generoa eskainiz.

Barrea gozatu zitzaion Uriberi, eta barreak berak zeraman erantzuna.
-Ez, bistan da ezetz –etsi zuen Artzubik.

Ez zen mindu hala ere. Aisa antzeman zion Uriberi berezkoa zuela barre eder hura, baina nekez igarri ziezaiokeen noraino zuen berezko. Irribarrez jaio baitzen Uribe; irribarre egin zion emaginari, haurrek lehen negar larria egiten duten une horretan.

Esan liteke jaiotzatik bertatik hasi zela munduari beste modu batean begiratzen.

-Beharrean egonda ere, batzuek ez dituzte alokatu nahi izaten. Jende mizkina dabil asko –esan zion Artzubik etenaren ondoren.

Salmahaian lerroz-lerro ipinita zeuzkan hortzeriak banan banan zapitxoetan bildu eta zurezko kaxara jasotzen hasi zen.

-Bolizko hauek alokatzen dizkidate agure zaharrenek. Emakumeek nahiago izaten dituzte portzelanazkoak –jarraitu zuen azalpenak ematen mahaitxo gainean zeukan hortzeriarik zurienetako bat erakutsiz-. Dotoreak dira ikusten duzunez.

Artzubiren berriketa eta keinuei arreta handiz begiratzen zien haren oinetan kokorikatuta zegoen gizon beltxaranak, baina Uriberen barreari erreparatzen zion batezere. Artzubiren gabardina barrenari tinko helduz, Uriberen barre-hotsarekin makurtuago eginez, ikusezin bihurtzeko ahaleginetan ari zela zirudien. Kezka nabarmentzen zitzaion bekeran; izua agian.

-Hau Balu da –aurkeztu zion Artzubik, Uriberen begirada galdera zela ulertuta-. Besteok legez, zerbait galdu ondoren iritsi zen Galduen Ostatura. Elkarri konpainia egiten diogu ordutik.

Hitz urriko gizona zen Artzubi; Galduen Ostatuko bezeroak ezagutzen dituenak badaki horren berri. Maitasuna, ohorea, lana eta itxaropena galdu zituela esanez agertu zen behinola. Ez ordea erabat etsita; horiek guztiak galduta ere zerbait geratzen dela errepikatzen zuen behin eta berriz. Ez zuen asko gehiago esaten, mostradorean kaferen bat eskatzeko izan ezean.

Hondamendiko leizera jausia zela iritzita, ostatu atarian mahaitxoa ezarri zuen egun batez, eta hortzeriak, zeinahi itxuratako hortzeriak ipini zituen han, beharrean zenari alokatzeko. Saltzea nahiago zukeen ia, baina hotzik

gabe zebiltzanek nekez izango zuten haiek erosteko adina ondasun. Garestitxoak ziren.

Hasiera batean errezeloz begiratzen zioten batzuek, herabe antzean besteak, baina laster hasi zen jendea poliki poliki hurbiltzen. Bazkaritarako edo afalorduan alokatzen zizkioten gehienek. Gosaritarako apenas inor hurbiltzen zitzaion haien bila.

-Neuk egiten ditut –jarraitu zuen Artzubik, Uriberen irribarreak hartara gonbidatzen zuela iritzita-. Sagar eder bat jan nahi bazenu, edo madari urtsua, edo okaran zuri biguna, esate baterako, bolizko hauexek dituzu onenak. Baina okela jatun petoek altzairuzkoak nahi izaten dituzte. Jendeak ez du erraz etsitzen; ez dena izan nahi du askotan. Gizakia edoskitzaile jaiotzen da, titiko, eta esango nuke zahartzaroan edoskitzaile izaerara itzultzen dela ostera. Naturak itzultzen du, hortzeria jausaraziz. Ez diogu izaera horri amore eman nahi izaten ordea; okela jan nahi dugu, esnea eta ohia edoski ordez. Eta urrezko hortzeria nahi dugu gainera. Apostata handi bat da gizakia.

Izendatu ahala Uriberi erakusten zizkion gai batekin edo bestearekin egindako hortzeriak, eta zapitxoan bildu ondoren zurezko kaxan gordetzen zituen banan banan.

-Ez dituzu behar, beraz? –galdetu zion berriro ere, eta eskaintza moduak barrea zabalago egin zion Uriberi-. Ez; jakina… Badira zurezkoak aukeratzen dituztenak ere. Ezpelez eginak dira onenak nire ustez. Jaki bigunari ekin behar badiozu batezere. Gozoak dira ezpelezko hortzeriak, leunak. Kolorearena, horixe daukate… Urkiarena zur ona da, kolorean ere aproposa, eta estimatzen du jendeak. Bai, zuri-zuriak urkiarenak. Zure horien tankerakoak. Bakoitzaren berezkoak onenak hala ere, horixe baietz. Ez, zuk ez daukazu hauen beharrik.

Ordurako oihaltxoetan bilduta zurezko kaxan gordeak zeuzkan hortzeriak handik hartu eta ostera mahai gainean ipintzen zituen Artzubik Uriberi erakusteko. Haietako bakoitzaren erabilgarritasuna, haiek egiteko

zailtasunak eta gainerako xehetasunak azaltzen zizkion. Ezagun zuen ofizioari emana zegoela, eta ezer gabe geratu ondoren zeregin egokia aurkitu zuela zerbitzu lan hartan.

Mahai gaineko hortzeriak berriro euren zapitxoetan bildu, kaxan ipini eta ixtera zihoanean, gizonezko ondo jantzi bat hurbildu eta zapitxoan bilduta eskuan zekarren hortzeria utzi zion mahai gainean.

Gizonezkoa bere bidean urrundu zenean, zapia zabaldu eta han bilduta zegoen urrezko hortzeria ederra azaldu zuen Artzubik. Pintxoren batzuen arrasto eta hondakinak kendu zizkion eskuila txikia pasatuz, eta, bere distira osoa itzuli ziola iruditu zitzaionean, berriro zapian bildu eta zurezko kaxan gorde zuen.

-Egunero alokatzen dit, goizerdi inguruan. Ez du bazkari handirik egiten, ez. Hiru-lau pintxo nola-halako jango ditu, baxoerdiren batzuekin; hondakinek salatzen dute zeri heldu dion hortzeriak –azaldu zion Uriberi-. Dotorezia ematen du urrezko hortzeriak, jakina, eta besterik ezean ona da dotorezia. Ederra da urrezko barrea; ohorea du. Baina garestia da, garestiena, urrezko hortzeria. Arrisku handia duelako. Tentazioa, badakizu. Urri alokatzen ditut urrezkoak. Zuk… ez, jakina, zuk ez… Ohitura da; barkaidazu.

Itxi egin zuen halako batean zurezko kaxa, eta salmahaia jaso zuen, hankak doblatuz. Azkenik, zurezko kaxa esku batean hartu, salmahai txikia Baluri eman, eta Galduen Ostatura sartu zen.

Atzetik ikusita, sorbalda eraitsi samarrak eta lepogain konkortua zeuzkala iritzi zion Uribek Artzubiri. Gurdia eraman ezinean burua makurtuta zihoan idi uztartuaren irudiak klik egin zion, argazkia ateratzerakoan argi eztandak bezala. Nekeak, etsipenak agian, zafratutako gizonaren irudia zen, oroimenen batetik askatu ezinean zebilenarena.

Balu are makurtuago sartu zen, haren saihetsean ia kukututa, Galduen Ostatuko atean barrura, begi zeharka atzera begiratuz.

Mostradore inguruan zintzilik zeuden lau-bost urdai azpikori erreparatu zien Uribek. Bestaldean, bost-sei mahai luze, zortzi-hamar bezerorekin haietako bat. Bezero haien atzeko horman, basurde burua letaginak erakutsiz, haserre keinuan inola ere.

Mahaian eserita elkarri begira geratu zirenean irritik barrera arteko bekera egin zion Uribek Artzubiri. Berezkoa izateaz gain, bere egoeraren adierazlea ere bazuen neskak barre hura. Termometroa. Artzubiren ahotsak eta keinu sosegatuek eragiten zioten seguru asko; ez gizon barregarria zelako, haren ondoan eta leku hartan egotea gozagarri zitzaiolako baizik.

Baluk izutu samarra ematen zuen hala ere; Uribiren barre eta begiradapean izutuago. Artzubiren alboan eseri zen aulki txikiago batean, okotza mahai parera doi-doi iristen zitzaiola, isilik, begiak platera bezain zabal.

Bazkaritarako prestatu zirenean, zurezko kaxa ireki, zapitxoetako bat hartu eta zabaldu, eta bolizko hortzeria ederra ahora eskaini zion Artzubik Baluri.

Apaizak mezatan emandako sakramentu santua fededunak nola, halaxe ahoratu zuen Baluk Artzubik emandako hortzeria, eta klak klak klak egin zuen horzka, ajuste ona zutela frogatzeko edo.

Ezer gertatu ez balitz bezala, lehengo jarrerara itzuli zen Balu ostera, kokotsa mahai ertzean jarriz, begiak zabal zelatari.

-Hemen gauden guztiok dugu geure historia ezkutuan edo agerian. Baluk ere bai. Bere historia hori eta bere burua ezkutatu nahian dabil ordea, eta arrazoiak ditu horretarako –hasi zen Artzubi Uriberi begira, eta Galduen Ostatura iritsi berritan Baluk kontatu zuen historia azaldu zion.

Bere lagun batekin haserretu eta borroka gogorra egin zuen Baluk. Ukabilkadaren bat muturrean eman eta atzeraka erortzean buruarekin harria jota, zerraldo utzi zuen lagun hori.

-Nik ez nuen hil nahi laguna; ez nuen hil nahi. Laguna nuen, laguna nuen –esaten zuen bere pasadizoa kontatzen.

-Baina hil zenuen –erantzun zion Iehor Lukariok.

-Berak badaki ez nuela hil nahi; hurrengo bizitzan elkar topatuko dugu eta lagun izaten jarraituko dugu. Ondergroun! Azalduko diot ez nuela hil nahi izan –ostera Baluk.

- Hurrengo bizitza? Beste bizitza? Inork ez du joan nahi beste bizitzara; oraingoarekin jarraitu nahi dugu guztiok, eta zure lagunak ere jarraitu nahiko zuen –tartekatu zen Asmodeo-. Eta beste bizitzara berpiztu bada, zuk zure hemengo egunak bete eta berpizten zaren arte zain egongo dela uste al duzu, zure azalpenak entzun eta adiskidetzeko? Haserre egongo da bizia kendu zeniolako, eta zure bila dabil honez gero. Ez zenuke ibili behar zein zaren esaten eta zure historia hori aldarrikatzen. Laster aurkituko zaitu bestela.

Baluk ez zuen erantzun oraingoan. Bat-batean zurbilduta, mutu geratu zen, begiak zabal. Artzubirengana hurbildu zen, haren gabardinapean babestu nahian legez, kuzkurtuta.

Ostatu atarian hortzeriak ipintzeko mahaitxoa hara eta hona garraiatzen lagundu, haren oinetan kokorikatu eta konpainia isila egiten zion ordutik Artzubiri. Jatorduetarako ematen zion hortzeria ordezkoarekin nahikoa zuen itxura batera Baluk. Inork ez zion berriro bere historiarik entzungo.
-Norbait behar izaten dugu aurrean, edo ondoan, oroimenean gutxienez, historiak kontatu edo barre egingo badugu. Beharrezkoa zaigu historiak kontatzea eta barre egitea, ihartuko ez bagara –esan zuen halako batean Artzubik.

-Denbora da inoren berriketa hotzik entzuten ez dudala. Urrutitik nator. Agur-Aringo geltokian galdu nuen aurreko solaskidea. Joxe Txurtxa zeritzala esan zidan, eta Galduen Ostatu honetan egona zela –erantzun zion Uribek.

-Artzubik andregai gaztea aurkitu du itxura denez –esan zuen Xeberok alboko mahaian.

Ez dakigu zer erantzun zioten mahaikideek, zer burutazio izan zuen Lukariok edo zergatik begiratu zion Asmodeok Galduen Ostatuko etxeko andreari.

Tira, bai; Asmodeok etxeko andreari zergatik begiratu zion susmoak badauzkagu. Baina keinu eta begirada xumeak ziren mahaikide haienak, eta nekez antzeman zezakeen ezer haien berri aurretik ez zekien inork. Munduko karriletik erauzitako aleak iruditu zitzaizkion Uriberi alboko mahai hartan eta bere aurrean zeuzkanak. Eroso zegoen hala ere.

Joxe Txurtxaz gogoratu zen berriro; leku aproposa izan behar zuen bere garaian ostatu hartan.

-Lehoi baten aztarnak jarraituz zebilela esan zidan Joxe Txurtxak. Baina galdu egiten zitzaiola arrastoa. Agur-Aringo geltokian jaitsi zen, pixa egitera. Hantxe galdu nuen –azaldu zion Artzubiri.

-Egin beharrekoa izaten da hori ere.

Berriro Joxe Txurtxaren aipamena entzutean Uriberengana itzuli zen alboko mahaikoen arreta.

-Leihotik begira geratu nintzaion, laster itzuliko zelakoan –jarraitu zuen Uribek-. Elur zuriaren gainean arrasto horizta egiten ari zen, lurruna zeriola. Esku batekin prakei eusten zien bitartean, irudiren baten eitea ematen ari zitzaion elur gaineko arrasto horiztari. Trena abiatu zenean bere jarioari begira jarraitzen zuen artean. Hots egin nion eta ohartu zen halako batean; korrika abiatu zen trenaren aldera, esku batekin prakei goian eutsiz. Trenera igotzeko, bagoiko atearen alde banatako heldulekuetara luzatu zituen eskuak, baina prakak txorkatiletara jausi zitzaizkion orduan… Hankak praketan trabatuta erori zen trenbide ondoan, luzean luze. Han geratu zen.

-Trena galtzeko modu asko daude, baina hori baino narraxagoak gutxi egongo dira -erantzun zion Artzubik-. Piura tristea da adineko gizonezkoarentzat.

Alboko mahai luzearen parean horman iltzatua zegoen basurde buruari begiratu zion Uribek berriro. Muturkera hark, letaginak erakusteko modu hark, haserrearen irudia izan behar zuen.

“Basurdeak eta gainerako txerri jendeak ere izango dute ba pozaren edo gure barrearen pareko keinuren bat”, bururatu zitzaion.

-Ordezko hortzeria beharrik ez horrek –esan zion Artzubik begiradari jarraituz.

Barre zabala egin zuen neskak.

Mahai luzeko zortzi-hamar bezeroek ere burua itzuli eta basurde muturrari begiratu zioten.

-Gizaki bati bere bihotza kendu eta txerriarena ipiniko baliote, berdin sentituko ote luke? Berdin maitatuko ote luke? –galdetu zuen Uribek Artzubiri begiratuz baina alboko mahaikoek entzuteko moduan.

-Galdera txerria da hori –bota zion Luxiok mahai hartatik.

-Bere bihotzarekin ere txerri samarra da gizakia; gutxi behar izaten du uxarrean hasteko. Txerriaren bihotza ipiniko baliote berea kenduta, ez egin dudarik txerri osoa izango litzatekeela, belarriak gorabehera –Txarabek.

-Lau hankako belarri-handiari irain larria egiten ari zarete. Animalia noblea da txerria, heriotzari ere garrasi eta buerda gogorrekin errebelatzen zaiona. Abereen artean ondraduena izango da. Izena ez da beti izana –eraso zien Asmodeok.

Trumoi hots ikaragarria legez entzun zituen Baluk hitz haiek; bere lekuan uzkurrago egiten joan zen Asmodeoren hitzak entzun ahala, burua sorbalden artean kikilduz, Artzubirengana arrimatuz, eta, hura isildu zenean, hormako basurde buruari begiratu zion.

Basurde haren letagin zorrotzak, haren muturkera zimurra eta itxura haserrea… Zuzen berari begiratzen ziola begitandu zitzaion.

Ukabilez jota hil zuen lagun berpiztuaren irudia gogoratu zuen ezinbestean. Muturkera hura, haserre hura, ez ote zen zinez bere lagunaren haserrea? Begi haietatik begiratzen ziona ez ote zen bere laguna berpiztua?

Ikaratuta, ostera bere platerari begira geratu zen, okotza mahai ertzean zuela, lehen baino kuzkurtuago eginez Artzubiren ondora. Haren gabardinapean desagertu nahi zuen.

Platera hustuari begira egon ondoren, zurezko kaxa ireki zuen Baluk mugimendu urduri eta bizkorrekin. Handik hartuta mahai hegalean zabaldu zapitxo bat, eta ordezko hortzeria zuria oka bota zuen haren gainera, sugeak arrautza azal hautsia legez. Bolizko hortzeria zapian bildu eta zurezko kaxan ipini zuen ondoren. Platera hutsari begira geratu zen azkenik, begiak zabal, ahoa estu.

Balu eta Artzubiri aurrena eta alboko mahaikoei ondoren begiratu zien Uribek. "O gu hemen, bidean galduak", egin zuen berekiko.
-Trenera noa berriro –esan zion Artzubiri, isilunea luzeegi egin ez zedin, eta mahaitik jaikita atera abiatu zen.

*Jokin Urain*
*La Moralejan, 2006ko uztaila*

**Lirioak urdin**
**Begiak berde**

Lirioak urdin zitunan hire maiatzean eder
Inaustean jantzitako kolorez maite
Hituen bizitasunez begiak ferde
"Egunak badoazi" egunekoan hizkiak
Ondoeza hizkiak eta sentimenduen kartografiak
Opari izaren izpiliku perfumeaz gaindi
Izerdi mintzez jostean
Behialako batean
Gazteagotan.

Baina beti gertatzen dun zerbait berezi
Izan Urtemuga izan Aberri Egun
Zola ez diten karrikek arras ordoki
Argirik ez zegonan udaberriak lo hartzekotan
Ostargi-belarrak azkenerako ihartzen ditunan
Lurrina galduz ahituz beheratuz distira
Minik egin nahi ezik bezala
Hamaika bider ezkotuz antzera
Hinki-hanka begietan sigi-saga behera
Zerutik trumilka amildegien leizera.

Lokatz horretan geratu gintunan
Eguneroko Bizitza nahasian
Eraikitako zubiak zartatuz
Sortutako adiskidetasun nahi
Hura ere lohi bihurtuz
Hala nola elurra bera
Askotan zapaltzen denean
Lokatz horretan geratu gintunan.

Denaren grisaren arren
Bogartek euskaraz baleki
"Beti izango dinagu Bilbao"
Murmurikatu zinan aspaldi
Baina ni ez naun Humphrey
Krema koloreko gabardinak
Laket izanagatik ere
Ez naun ni Bogart.

Hori eta horrenbestez
Urtaroa itzultzen dun
Nolabait lirioentzako
Denborak ez din dena galbidean jartzen
Errota bezala itzulikatzen omen
Eta beharbada elgar berriz
Ikusiko dinagu geroan
Euskal Herrietan aske
Lirioak urdin
Begiak ferde.

*Henry Bengoa*

## Neguria

Negua zabaldu egin da

Noiz eta orain
Eguzkia garondoak gorritzen
Hasia zenean

Iragarria egonagatik ere,
Sugeak ez du azala aldatuko
Eta atzean utzi
Uzten diren bezala oroitzapenak
Eta zoriona;
Memoriaren azala.

Haritza ez da, neguoro legez,
Elurrari aurre egiteko
zentimetro batzuk makurtuko
nola makurtzen diren ilusioak
Eta bizitza;
Ausentziaren elurra.

Borroka beste bat da.

Ez zaitu ahaztu nahi.
Ez dut egingo.

*Henry Bengoa*

## Promenatzeak on egiten dio pertsonari

*Tous les malheurs des hommes viennent de ce qu'ils ne peuvent rester en repos dans leur chambre.*

Robert Walserrek elkar ikuste bat proposatzeko telefonoz deitu zidan iragan igandez. Oso hitz gutxikoa izan zen hots egitean. Ahots urduriz mintzo zitzaidala antzeman nion hariaren bestaldetik. Hitzak trabatzen zitzaizkiola, ahoa lehor eta ezpainak siku bailituen.

Paseatzeko elkartu ginen. Aste guztia bere dei horren zio ezkutua asmatu nahian igaro nuen. Alferrik. Aspaldian ez nuen beraren berririk eta traketsa egin zitzaidan telefono kolpe horren motibazioa deszifratzea. Baina, zerbait garrantzizkoa behar zuen izan, edozein kasutan.

Klagenfurteko *Landareen Lorategian* hitzartu genuen zita. Igandea haragi bizitan esnatzen ari zen, eguzki-argi gordina zitroizko kaleetan barna sartzen ari zela bertaratu nintzanean.

Sakelako erlojuari begira ikusi nuen Robert. Zilarrezko ordulari borobila txalekoaren poltsikora itzuli eta, burua altxatzean nire etorrera baieztatu ahal izan zuenean, irri labur batez agurtu ninduen. Atzerapenagatik azalpen bat eskatuko zidala iruditu zitzaidan, baina bere lehen hitzak pausatuak eta erabat bestelakoak izan ziren.

- Egun zoragarria hautatu diagu, Henry maitea. Egun ezin hobea, zilegi bekit esatea.

Sorpresaz hartu ninduten bere estreinako hitzek, agur horrek zeharo harritu baininduen zazpi egun atzera nabarmendu nion artegatasunarekin alderatzean. Nire astebarruko galderak hutsalak izan zirela begitandu zitzaidan instantean. Ez nuela zertan kezkatu beharrik izan bere zirkunstantzia pertsonalez. Ezinezkoa zen Robert arazotan edo arriskuan izatea, bere kaudimen egoera nahikoa erosoa zen etxearen alogera ordaintze-

ko, eta editorearekin zituen harremanak onak ziren, bere lehen bi nobelak, best-sellerrak izan gabe, merkatu literarioan arras ongi saltzen zirelako gainera.

Igandezko jantzi ilun eta lisatua zeraman soinean, kapela luzea buruan eta paseo makila eskuan. Ziurtasunez jantzia, ohitura zuen legez. Emaztearekin izaniko liskar arinen baten ondotik deituko zidala juzgatu nuen bada.

Lorategiko lilien eta ur-putzuen itzulinguruan Eguneroko Bizitzaz eta gauza xaloez hizketan aritu ginen berrogeita hamarren bat minutuz, eguzki izpien goxotasunaren pean, zisneen eta kurriloen lekukotasun bakarti baina perfumatuan.

Bere emazteaz galdetu nionean ondo aurkitzen zela eman zidan aditzera; aurrera begirako zonbait proiektu zituztela buruan, etxe-aldaketa tarteko, eta Armanda bere aholkulari leiala zela obra artistikoari zegokienean, "ordezka ezina" esan zuen. Robertek arruntki egitea laket zituen paseotan oinarrituz nobela bat idaztea iradoki ziolako, "fabulosoa" iruditu zitzaiona ezbairik gabe.

- Badakizu, lagun maitagarri hori, promenatzeak on egiten dio pertsonari. Ez dakizu zenbat on egiten dion gizakiari haize freskoa hartzeak, gaur egungo egun zurbiletan!

Robertek animu egoera aldaketa arin bat jasan zuen hitz horiek ahoskatzearekin batera, ordura arteko patxada armoniatsua apurtuaz horrela. Are serioago jarri zen eguerdiaren hurbilarekin lorategi ingurura bikote eta ibiltari ezberdinak gerturatzen ari zirela ikustean, eta sugea bailitzan, piztiarik sotilena bezala, lorategitik irteteko gonbita egin zidan, ezker eskua nire bizkarrean paratuz eta eskuinekoan zeraman makilarekin irteera seinalatuz.

Irteera bidean, ur-putzuaren gaineko zubitik igarotzean geldiune bat egin zuen, eta ibiltariei atzera erdeinuz begiratuaz, inork ulertzea nahiko ez lukeen moduan, hitz frantsesak xuxurlatu zizkidan belarrira.

*- On est foutous avec cette malheureuse influence du kitsch sur les masses, surtout quand elle s'exerce sur l'âme purifée des hommes d'action comme nous. Le peuple se fiche bien des génies! Il faut redécouvrir le bon goût de l´art! Et pour cela il faut que tu m´aides. Il faut réagir!.*

Ez nuen bere bat-bateko humore aldaketa hori ulertu. Are gutxiago adierazi nahi zidana. Ez frantsesa ulertzen ez nuelako, entzumena eta irakurmena landuaz ikasi bainuen nola erreen soinua, bibrazio ozenik gabe, aho sabaian atzerago ahoskatu behar izaten dela, hitz amaierako letrak frantsesez ez direla entzuten, banekien zelan ahoskatzen diren diptongoak, au, o; oi, ua.

Ulertezintasuna bestelakoa zen, *Kitsch* hitza Alemanian espresio arrunta zen gustu txarreko artea adierazteko, baina bere eragin positiboa ukaezina zela iruditzen zitzaidan, jendea kulturara erakartzea beti pozgarria den heinean.

- Barkatuko didazu Robert, baina ez dakit zer esan nahi duzun "Kitsch" horrekin -esan nion.

Robertek mesprezuz egin zuen irri, baina bere begiradak gehiago zuen tristeziaz ironiaz baino; tristeziaz erdiragarria eta sakona zen, egiazki.

- Jakina ezetz… eta ez duzu jakingo nik esan artean. Esan nahi du "kordea galtzeko moduko argumentua batekin egin duzula topo".

- Baina "kitsch" hitzak ez du "kordea galtzeko moduko argumentua" esan nahi -jarri nuen egoera deserosoan.

- Nik hitz bat erabiltzen dudanean, -tematu zen Robert- esan nahi du nik esan nahi dudana…, ez gehiago eta ez gutxiago.

- Kontua da –setatu nintzen- hitzek horrenbeste gauza diferente esanahi izatea posible ote den.

- Kontua -erabaki zuen Robertek- zeinek agintzen duen jakitea da… hori da dena!

Zurtuta geratu nintzen ezer ere esateko. Lorategitik kale hotzagoetara eta babestuagoetara jo genuen. Bakanak ziren ibiltariak ingurumaria horietan. Kotxeren bat edo bestek errepidea egiten zuen norantza galduan, baretasuna ikus zitekeen gidari eta gidari-ondokoetan, lasaitasuna arnastu zitekeen, irakur zitekeen moduan lasaitasuna jai-egunetako prentsa idatziaren goiburuetan.

Hitz bat bera egin gabe egin genuen aurrera, espaloi gris erraztuaren bazterrean ilaran prezisioz aparkatuak zeuden autoen albotik. Ez nekien zer bildu hizketarako gai. Beldur nintzen Roberten erreakzioari, baina era berean banekien isiltasunezko eten horrek Roberti astia eskaintzen ziola buruan izan zezakeen ideia are garatzeko eta ordenatzako, eta horrek jakin-mina eragiten zidan.

Akazien etorbidea zeharkatu eta J. W. Goehe Barnetegiaren parera iritsi ginean, ezpainetan alemanerazko hitz perfektu horietako bat ebaki zuen Robertek.

- Horixe bera! *Der Mann ohne Eigenschaften!*

Barre maltzur bat marraztu zitzaion aurpegian eta une batez Barnetegiari begira geratu zen. Barne burutazioetan murgildua jarraitzen zuen.

- Zera… Robert, bazkal ordua gertu da eta emaztea zain izango duzu. Pentsatzen aritu naiz eta agian etxera itzultzea izango dugu onena –jaulki nion. Arraro sumatzen nuen eta agian hitz horiekin bere onera etorriko zelakoan jaulki nion.

- Batzuetan etxera itzultzea denik eta gauzarik zailena da –esan zuen.

- Lehenbiziko trena hartzea nahikoa da horretarako –ihardetsi nion.

- Oso literarioa! – erantzun zidan trufa algaraka – Niregatik, dena den, ez duzu zertan kezkatu beharrik, adiskide betiko maitea. Armanda kanpoan da, lagun batzuekin *Tiffany's*-era gosaltzera joana, eta ilunabarrean da itzultzekoa –Robertek hasierako zuhurtzia berreskuratu zuen-. Gaurko eguna zurekin igarotzea pentsatuta nuen. Horretarako hots egin nizun preseski, huntaz eta hartaz hizketatzeko elgar gintezen. Bazkaldu dezakegu sandwich bat nahinon, eta gerora azaldu behar dizkizut zenbait jakinarazpen. Zer diozu? Gainera, ezer egitekorik ba al duzu etxean bada? – begi marroi sarkor eta maleziaz distiratsuak nireetan pausatuz, bekainak zimurtzen zituela egin zidan galdera; nola egiten dituzten galderak, ez ama arruntek, baizik eta areago, polizi komisarioek zerbaiten ustea dutenean.

- Ez da presazkoa… baina bai… etxeko lanak egin gabe ditut oraino. Baliozko hainbat gauza fite bildu eta aztarnarik utzi gabe bertatik alde egin beharrean naiz. Lagunak Hanburgoko nire etxera jo zutela jakin dut. Bertan topatu ez baninduten ere, etxe-jabea azaldu zitzaien eta alogera ordaintzeke nuela informatu. Apartamentuko inbentario zehatza egin behar izan zuten. Gozoak egongo dira! Euskal Herritik Alemaniarako bidaia egin, ni topatu ez eta, gainera, etxean topatutakoaren informe xehea egin beharra! Uste dut bi asteren buruan iritsi daitezkeela luza gabe. Egunkarien ebakin eta ohar mekanografiatuen artean topatuko zuten egungo helbidea. Eta kriptatua egonagatik ere, iaioa da hitz-jolasekin Bernardo…

- Beste gauza konprometigarriagorik geratu al zen bertan? –galdetu zuen Robertek.

- Litekeena da anotazio narrats batzuk ere bertan laga izana. Portuko itsasontzien ingurukoak. Espainiatik Pérez Reverte, Gala, Sánchez Dragó eta enparauez bete liburu datozen merkantzia-ontzien ordutegiak ziren, Enrique Vila-Matas kataluniarrarekin zelatatzen aritu nintzenekoak.

- *Katastroffa!* - Larritu zen Robert.

Bere garrantzia bazuen Frankfurteko etxea albait arinen txukun eta garbi uzteak. Baina asteazkenetik aurrera egitea gomendatu zidan Robertek. Beste "egiteko handiagoak" genituela eskuartean. Nik, ordea, inbentario berri bat egitera ez nituen behartu adiskideak, euren haserrealdia bortxatu aurretik etxea txukundua eta ordenatua utzi nahiko nuke gutxienean, baina oraingoan ere hankaz gora eta alogera ordaintzeko utziko niela iruditu zitzaidan, ez zidala astirik emango asteazkenean anotazio eta ohar eta ebakin eta txosten eta pista guztiak garbitu erre desegin kiskali ezkutatu desagertarazi komunetik behera botatzeko, eta beraz lagunak berriz ere etxean zegoen guztiaren informe detailezkoa egin beharko zutela nuen buruan eta, orduan, niri, zerbait hautsi egin zitzaidan bihotzean, kra.

Kafetegi batera jo genuen zerbait jatekotan. Bi sandwich eta pitxer handi bat garagardoz betea ekarri zituen zerbitzariak, Robertek hala eskatuta. Ondoko mahaian bikote bat zegoen zigarro erretzen eta hizketan. Kafea eta tabako kea.

- Ah… ba, niri asko gustatzen zait irakurtzea – esan zuen gizonezkoak.

- Nik nahiago zinea – erantzun zuen emakumezkoak.

Robertek ahoan zuen sandwich pusketa lurrera tu egin zuen eta garagardo txarroa arriskuan jarri zuen kolpe gogor bat eman zion mahai biribilari.

- Ez dira gauzak propietatez esateko gai ere! Noiztik esaten dugu "jatea gustatzen zait" edo "edatea atsegin dut". Kulturarekin ordea zilegi da horrelakorik esatea, antza. Nora doa gizateria horrelako jendailarekin!

Ez nuen Robert bere onetik atera nahi izan eta ez nion galdetu "horrelako jendaila" esapidearekin zer esan nahi zuen. Eten bat egin zuen Robertek, eta poltsikotik purutxo kaxa atera eta haietako bat isiotu zuenean, ekin zion berriz ere.

- Okerra da "irakurtzea gustatzen zait". Zuzena ez den bezala "jatea gustatzen zait" esatea. Baina iduriz, deabruzko aldea dago tripa bete eta burua elikatzearen artean! Jendeari entzun diezaiokezu esaten "legatza saltsa holandesean gustatzen zait" edo "Bordeleko ardoa maite dut". Modu berean esan beharko genuke, hortaz, "Hermann Hesseren *Das Glasperlenspiel* liburua maite dut" edo "Godarden eta Antonioniren pelikulak atsegin ditut". Baina baita zera ere! Ahosabaia biguna du jendeak gauza batzuetarako, baina hezurrezkoa kulturarako. Zehaztasun hori batzuetan ez da horrenbesterakoa izaten, eta entzuten da "arraina gustatzen zait" edo "xanpainak zoratzen nau". Hori eta horrenbestez, esan beharko litzateke "30. hamarkadako zinema estatubatuarra gustatzen zait" edo "Frank Kafkaren obra guztia dut gogoko". Baina hori ere ez… "niri asko gustatzen zait irakurtzea"! Horixe da gaur egungo gizakia, ezaugarririk gabeko gizakia, *der mann ohne eigenschaften!*

Argigarria suertatu zitzaidan Roberten azalpena. Bere haserrearen arrazoia egokiro ulertzen hasi nintzen; jende arruntak kulturaz aritzerakoan erabiltzen zuen zehaztasun gabezia ezin zuen sufritu; gaizkitu egiten zen garaikideen gustu kulturalez ohartzean. Jakin-minez itxoiten nuen esateko zidana, aste bete atzerako telefono kolpearen muina bistaratzen ari nintzelako, hala nola bistaratzen den lanbro artetik hodeiartea, argigunea.

Kafetegian denbora egin genuen. Bere liburuen salmentez galdetu nion, lehen bi liburuez hitz egin zidan berak, nahikoa ondo saldu zirela eta nola Geschwister Tanner hiruzpalau astetan izkiriatu zuen, baina *Jakob von Gunten* hirugarren nobela argitaratzean sona galtzen hasi zela, salmentek gainbehera egin zutela, justu epoka berean Robert Musilek beste nobela bat argitara eman baitzuen, eta bere lanak kritika literarioetan tarterik aurkitzen ez zutelarik, idazle ahantzi, marjinal, bazterreko, madarikatu eta gaitzetsi bilakatu zutela, Walter Benjaminek bere obra irakurtzeko gonbita egin behar izan zuelarik. *Bref* , ez zirela garai onenak lirikarako.

Robertek txalekoaren barne-poltsikotik gutunazal txiki beix bat atera eta eskura hurbildu zidan. Handitasunez hitz egin zidan orduan.

- Literarion Aurkako Gurutzadak aurrerapauso handiak eman ditu azken aldian eta *Bureau Littéraire*-ak krisi kabinetea deitu du astelehen gauminerako. Bileraren helburua aurrera begirako estrategia definitzea da. Hemen duzu Hans Castorpek bideratzen dizun gonbita.

- Nor da Castorp hori? – galdetu nion.

- Mann… Thomas Mannen goitizena da – erantzun zidan diskrezioz.

Gutunazala zabaldu nuen eta Underwood idazmakinaz idatzitako pergaminozko orri barnebilduari irakurtzeari ekin nion.

*Mundu guztiko idazle ahantzi eta bazterrekoei, agur t'erdi*
*Gutun honen bitartez Bureau Littéraire-ak krisi kabineterako deialdia luzatu nahi dizue. Bileraren helburua ildo kultural eta armatuari buruzko erabakiak hartu eta beroriek aurrera eramateko egiturazko erabakiak hartzea izango da. Egiturari dagokionez, klase artistikoaren funtzionamoldeari eta sortze-prozesuari buruzko neurriak zorrozten jarraitzea eztabaidagai izango da. Artista bakoitzaren hausnarketa eta ekarpena modu laburrean jaso beharko da ostera, guztien ekarpenekin ildoa aberastu ahal izan dezagun eta hausnarketaren ondorengo ildoan ekin dezagun.*
*Hitzordua: Suizako Davos-eko DerZauberberg-en.*
*Ordua: Astelehen gauminean*
*Laster arte, besarkada bero bat*

*Hans Castorp*
*Bureau Littéraire-ko idazkari*

Behin irakurri nuenean, Robertek puruaren laguntzaz kiskali zuen gutuna hautsontzian. Nire erantzunaren zain geratu zen.

Ohore bat zen gonbita jaso izana eta horrela adierazi nion Roberti. *Bureau Littérarie*-ko koordinatzailea zen Robert, eta bere paseoez baliatzen zen idazleen egitura informatua eta egunean mantentzeko.

Kafkak eta Musilek zuzentzen zuten Bureau-aren deialdira Mendebalde literario osoko idazle gaitzetsiak eta marjinalak azalduko zirela jakinarazi zidan: Frantziatik André Gide, Cesare Pavese Italiatik, Austriatik Stefan Zweig, Hermann Hesse Alemaniatik… Zerrenda luzea aipatu zuen. Gonbidatu asmo ziren zenbaitekin arazo eta kexka batzuk izan zirela aitortu zidan; hala nola Witold Gombrich poloniarrarekin, edo Milan Kunderarekin kasu, zeinek garai bateko abertzaletasun txekiarra albora-tu eta frantziar nazionalitatea zuen eskuratu, edo James Joyce irlandarra-rekin, zeinaren *Ulises* liburuaren laugarren atalera iritsiko denik ez dago-en, edo André Breton frantsesarekin zera, jarrai dezan *a chercher l`or du tems*, denboraren urrea bilatzen esan zuen, Marcel Proustek *a la recher-che du temps perdu*, denbora galduaren bila jarraitzen duen bitartean, eta halako batzuk, eta abar.

- Eta Euskal Herritik? – galdetu nuen – Euskal Herritik ez al da ordezka-ritza zabalagorik bertaratuko Mendi Magikora?

- Euskal herritarrak munduan denik eta herritarrik zorigaiztokoenak zare-te, Henry. Pentsa, hortaz, zein malapartatuak eta madarikatuak zareten idazleak… Joseba Sarrionandiak ohar bat idatzi du bere presentziaren ezinezkoa azalduz eta Mikel Antza atxilo eraman dute jendarmeek. Hi geratzen haiz guztietatik gaitzetsienen eta ahaztuenen artean.

Gonbiteari baietza ematera ausartu nintzen azkenean. Literarioen Aurkako Gurutzada geratu egin behar genuen. Engaiatu egin behar nin-tzen. Kolpe gogorrak jaso genituen gure lerroetan, bai. Baina, *rien n'est jamais fini, tout commence quand la plupart pensent que c'est fini.* Eta Robert klinika batean sartzeko bezain gaixo egongo zen literaturaz igual, baina bere fantasiak ez ziren gizabanako isolatu eta bakartu baten ames-keria tolesgabeak, gizagaixo baten buruko gaitzak ez ziren. Roberten eri-tasuna ez zen bakar baten zorakeria, bizi ginen sasoiaren beraren gaixo-tasuna baizik; Robert partaide zen belaunaudiaren neurosia baizik, eta gizabanako ahul eta mendekoei soilik ez zien erasotzen horrek; kontra-koa, indartsuenei, espiritualenei eta trebeenei ere.

Eguna bere azkenetara iristen ari zenean, iluna gailentzen, Roberti niri esker ona adieraziaz bihar arte batez agurtu nuen. Oinez abiatu nintzen tren geltokira, bertatik Frankfurterako trena hartzekotan. Biharko eguna egun erabakigarria izango zen.

Geltokiranzko bidea gurmatsu topatu nuen. Eta orduan, areago gaua, areago lainoa kalean, hezeago haizea, zailago eta ilunago pasabideak, argia egin zitzaidan: une horretan nire egoeraz jabetu nintzen, eta zalantza egin nuen, agian ez zela benetakoa Robert Walserrekin izan nuen hizketaldia, baizik eta ni ere zoratzen ari nintzenaren seinale. Kale-kantoi batean sartzean, lanbro artean Robert Musil ikustea iruditu zitzaidan, emagaldu bati dirua ematen ariko balitz bezala. Baieztatzekotan hots egin nion.

- Aizu, Musil… bihar han izango nauzu!

- Barka, baina tronpatu zara. Ez naiz Musil, Ulrich Untel baino – erantzun zidan begi-keinu batez. Emagaldua atzean utzi eta alderrai jarraitu zuen kale lanbrotsuetatik barna.

Nire ibilbidean aurrera segitu nuen. Promenatzeak on egin ote zidan galdetu nion ene buruari. Ez ote diren gizakiaren zorigaitzak bere gelan geldirik, atseden hartzen ez egotetik eratortzen.

*Henry Bengoa*

